**Lege Gordailua**
Depósito legal
SS-1471-2012

Euskal Presoen Aldeko Batzordea
Zuatzu, easo eraikina, 4 behea.
20018 Donostia, Euskal Herria.

**Aurkibidea**



## Mendeku gosez

Estatu espainolean hamarkadetako salbuespen legedia eta praktika arrakalatzen hasi den momentuan, indar eta lobby eskuindarrak ehiza mendekati bete-betean sartu dira; edo, hobe esanda, horretan segitzen dute. PSOE-Podemosen gobernua ematen ari den urratsak paralizatzeko ahaleginak eta bi egiteaz gain, etorkizun ez hain urrunean eman daitekeen estadioa ekidin nahi dute, kosta ahala kosta. Asociación de Victimas del Terrorismo delakoak Pablo Casado PPren presidentearekin egindako bilkuraren berri eman du. Izan ere, talde popularrarekin batera sukaldatutako "Terrorismoaren biktimen babeserako Lege Proposamena" aurkeztu nahi diete espainiar kongresuko talde parlamentarioei. Lege proposamen horrek lau puntu biltzen ditu:

- Biktimaren papera exekuzio penitentziarioan indartzea. Egun indarrean dagoen "Biktimaren Estatutuak" ahalbidetzen die baldintzapeko askatasuna errekurritzea; orain, hirugarren gradua edo kaleratzea suposatuko lukeen 100.2 artikulua errekurritzeko ahalmena eskatzen dute.
- Nahiz eta biktima zuzenik ez izan, biktimen elkarteek preso horien ibilbide penitentziarioan ere interferitzeko ahalmena izatea.
- Presoen birgizarteratzeko berme bezala, justiziarekin kolaborazioa exijitzea. Horretarako, Audientzia Nazionaleko fiskaltzaren bitartez, baldintza hau eraginkortasunez eman dadin mekanismoak artikulatzea.
- Terrorismoaren biktimen duintasuna babestea, presoak omentzea edo harrera egitea helburu duten manifestazio edota ekitaldiak zigortuz, baita Gobernu Ordezkariei ekitaldi hauek debekatzeko eskumena zehaztuz ere.

Argi dago estatu espainoleko sektore eskuindarrek eta erreakzionarioek gogortu nahi dutela espetxe-legedia, eta euskal preso politikoei dagokienean, mendekuan eta etsaiaren zuzenbide penalean oinarritzen dute politika hori. Frankismoaren ondorengo erregimen "demokratiko" horren azalean hazka egiten hasten denean...




# 13/13 Azken Makro-epaiketa

Errepresioa, disidentzia zigortzeko tresna izateaz gain, disidentziak gauzatu nahi duen proiektu politikoa edo ildoa baldintzatzeko Estatuaren edo agintearen baliabidea izan da beti. Urte luzez baieztapen honen garraztasuna bere larruan bizi eta ordaindu behar izan du Euskal Preso Politikoen Kolektiboak, eta honek utzitako ondorioen itzala luzea bezain gordina da.

Euskal gizartean itsasargirik distiratsuenetariko bat Euskal Preso Politikoen Kolektiboa izan da, batzuk beti ezkutatzen saiatzen diren gatazka baten tamaina eta izaera indar handiz islatzen duena. Arazoaren izaera politikoa agerian jartzeaz gain, honen irtenbidearen inguruko zutabeak gorpuzten aritu da behin eta berriro.

Horrela, itsasargi hau itzaltzen edo bere erreferentzialtasuna baliatzen saiatu dira ezker abertzalearen itsasontzia norabidez nahasi eta hondoratu zedin. Hauxe da eta ez besterik, ezagutu ditugun espetxe politika ezberdinen helburua eta, aldian aldian egokitzen eta formaz aldatzen joan badira ere, forma horien guztien helburua berdina izan da. Hori bai, presoen jarrera politikoa



bortxatzeko helburuz, giza sufrimendu bortitzena ezarri zaie haiei eta beraien senideei.

Erakutsitako eskuzabaltasunak eta ibilbide eredugarriak, neurri bereko elkartasun uholdea ekarri izan du urte luzetan zehar, gure herriak ezagutu duen mugimendu handienetariko bat bilakatzeraino. Parametro hauetan kokatu behar dugu uztailaren 12an Madrileko Entzutegi Nazionalean hasiko den 13/13 auzia. Honi guztiari erreparatzeko beharrezkoa da operazio poliziala burutu zen 2010eko testuin-gurua gogora ekartzea. Garai hartan ▶

# 13/13

**2010. urtea.** Ezker abertzalea konfrontazio armaturik gabeko agertoki politiko berria lortzeko prozesu betean zegoen murgilduta.

**2010ko apirilaren 14a.** Guardia Zibilak 10 lagun atxilotu zituen. Bost eguneko inkomunikazio aldian, torturatu egin zituzten haietako asko.

**Bake nahia oztopatzeko operazioa izan zen.** Euskal Preso Politikoen Kolektiboa agertoki berrira egokitzeko lanean ari ziren guztiak, presoak agertoki horretan eragile aktibo izan zitezen.

**Estatuaren estoldek diseinatu zuten operazioa.** CNIk oinarri legalik gabe parte hartu zuen. Frogak manipulatu zituzten. Hasieran, 13 ziren inputatuak.

**2021ko uztailaren 12a.** Zortzi euskal herritar epaituko dituzte Auzitegi Nazionalean: Arantza Zulueta, Jon Enparantza, Naia Zuriarrain, Julen Zelarain, Iker Sarriegi, Saioa Agirre, Nerea Redondo eta Juan Mari Jauregi.

> ***Konponbide demokratikoaren alde aritzeagatik, 77 urteko kartzela zigorra ezarri nahi diete.***

**Denboraz kanpo, lekuz kanpo.**
Kartzelak husteko garaia da, ez betetzekoa.

Zauriak sendatzeko garaia da. Gure herriak askatasunean, demokrazian eta elkabizitzan aurrera egiteko garaia.

ezker abertzalearen baitan eztabaida eta gogoeta sakon bat ematen ari zen bere ildo estrategikoaren inguruan. Eztabaida horretan beharrezkoa eta garrantzia handikoa zen presoen parte hartzea eta inplikazioa, itsasargiaren distira ezinbesteko bidelagun baitzen mahai gainean jarritako moldaketaren aurrean. Momentu horretan eta euskal preso politikoek egin zezaketen ekarpenari oztopoak jartzeko helburu garbiarekin egin zuten operazio polizial hura.

Operazio hau ez zen bakarra eta isolatua izan, beste batzuk ere burutu baitzituzten. Beste horien artean aipatzekoa Bateragune bezala ezaguna egin zena. Ez da analisi sakonik behar bi operazio horien helburua ezker abertzalearen gogoeta hura oztopatzea eta baldintzatzea zela esateko. Ildoa baldintzatzeko tresna gisa azaleratzen zaigu berriz ere Errepresioa.

Eta duela 11 urte egindako operazio hura gaur eramaten dute auzitara, 8 inputatuentzat 77 urteko espetxealdi eskaera luzatuz fiskaltzak, ETA-k borroka armatuaren amaiera iragarri zuenetik 10 urte pasa direnean.

11 urte beranduago, egungo auziak 2010eko operazioaren hari berberari jarraitzen dio. Estatuak ez du ez borondaterik ez alternatiba politikorik, erabakitzeko eskubidea aldarrikatzen duten estaturik gabeko herriei eskaini ahal izateko. Beraz, gaur egun gatazkak alde bateko adierazpen bortitzik ez duen arren, beste aldeak ematen duen erantzun nagusia errepresioa da. Modu horretan, herri honetako dinamika politiko nagusia burujabetza eta erabakitzeko eskubidearen aldarrikapenera lerratu ez dadin, eztabaida beste gai batzuetara eramaten saiatzen dira behin eta berriz, ahal den neurrian ezker abertzalea gatazkaren ondorioetan eta garai bateko eztabaidetan trabatua gera dadin, eta honekin batera gure herriko eztabaida eta dinamika politikoa lokazteko asmoz.

Zentzu horretan, beharrezkoa da auzia kokatzea demokrazia, bakea eta konponbidearen baitan; honi erantzun bat emateaz gain, dinamikak eta indar metaketak gure herriak behar duen agertoki demokratikoan kokatzen baititugu. Auzi honek, lotura zuzena du gatazkaren konponbidearen ekuaziotik desagertu behar diren hainbat osagairekin:

1. Euskal herritarrentzat eraikita oraindik indarrean dauden salbuespen legedi guztien desagertzea.
2. Indar polizial eta militarren kanporatzea Euskal Herritik.
3. Entzutegi Nazionalaren indargabetzea.

Beraz, hau ezin da mugatu auzipetuen arazo batera soilik, hemen jokoan dagoena eraiki behar den agertoki demokratikoa da, eta honen aurrean eragile bakoitzak duen borondate eta determinazioa mahai gainean jarri behar dira. Gaur eta hemen, gatazka politikoari errepresioaren bitartez aurre egiteko jarrerari ezetz esateko garaia da; herri bezala erantzun behar dugu, denon ardura baita elkarbizitza posible egingo duen agertoki demokratiko hori eraikitzea. Hitzak baino gehiago, ekintzak behar ditugu, gaur eta hemen.



irtenbidera
DEMOKRAZIA · BAKEA · ETORKIZUNA

Gure aurkako sarekada egin zenetik hamaika urte beteko dira egunotan. Gure etxeak eta bulegoak hankaz gora jarri, goitik behera miatu eta atxilo inkomunikatu gintuzten; bost egunez galdekatu eta gutako hainbatek tortura larriak jasan genituen; Entzutegi Nazionalak hamahiru inputatu gintuen.

Zortzi gara datorren uztailaren 12an Espainiako Entzutegi Nazionalean auziperatu gisara epaituak izango garenak: Arantzazu Zulueta, Iker Sarriegi, Jon Enparantza, Julen Zelarain, Naia Zuriarrain, Saioa Agirre, Nerea Redondo eta Juan Mari Jauregi.

Fiskaltzak denontzat 77 espetxe urte eskatu ditu.

Operazio poliziala testuinguru politiko oso zehatzean gertatu zen: Ezker Abertzalea bete-betean zebilen konfrontazio armatutik gabeko agertoki politiko berria eraikitzeko oinarriak gorpuzten, beti ere indarkeria adierazpen guztiak Euskal Herrian desagertzea bilatzen zelarik. Baina bultzada politikoa izan zuten hainbat polizi operazio eman ziren garai horretan: Bateragune deiturikoa eta beranduxeago Herriraren aurka egindakoak, adierazgarrienetakoak.

Euskal preso politikoen afera konponbiderantz norabidetzeko harreman zuzena eta bete-beteko lana behar zirela gauza jakina zen. Gu, modu aktiboan murgildurik genbiltzan Euskal Preso Politikoen Kolektiboa agertoki berrira egokitzen laguntzen eta eragile aktiboa izan zedin. Hor kokatu behar da operazio poliziala, asmo horiek zapuzteko saiakera gisa. Operazio hartan estatu espainoleko estolda aparatuek noraino iristeko prest ziren erakutsi zuten: babes legalik gabeko CNIaren inplikazioarekin, frogen manipulazioarekin, oinarrizko eskubideen urraketekin, tratu txar eta torturekin.

Hamaika urte geroago esan dezakegu Kolektiboaren ekarpena erabakigarria izan dela egungo agertokira iristeko. Inor gutxik jar lezake zalantzan bere erabakitasuna eta ekarpena, bide horretan etengabeko zangotrabatzea jasaten ari den arren.

Baina hamaika urte geroago, zoritxarrez, gatazkaren ondorio ugarik konponbiderik gabe jarraitzen dute, denboran luzatzen eta lokazten, sufrimendua eta samina eragiten. Atxiloketak, auziak, kondenak eta espetxeratzeak. Eta estrategia honen guztiaren ardatza Entzutegi Nazionalean oinarritzen da, berak segitzen baitu izaten iraganari kateatuta eusteko salbuespenezko tresna. Egoera politiko berriarekiko elementu deformatzaile eta baldintzatzaile izateko xede garbiarekin. Garaiko “ezpata hotsak” egungo “toga hotsak”.

Berriki Mikel Zabaltzaren hilotza ur azalera berragertu da. Harekin, ETAren esku liburuaren teoria Bidasoako uretan hondoratu da. Bitartean, torturatuen errolda zabaltzen eta errekonozimendua eta erreparazioa zorretan.

Hamaika gertaera izan da gure aurkako operaziaz geroztik: hamaika urte hain justu ETAren ekintza armatuak eten zirela. Bost urte, ETAk bere jardun osoa amaitzea erabaki zuela. Artean, euskal jendartean gatazkaren ondorioen eremuan urratsak aurreratzen joan dira. Herriraren aurkako epaiketa ere egin zen, babes sozio-politiko zabalarekin eta auziperatu guztiontzat irtenbidea lortuz.

13/13 auzia testuinguru honetan dator: denboraz eta lekuz kanpo seguru, inoiz denbora eta leku barnean egoterik baluke. Presoak atzerapen gehiagorik gabe etxeratzeko garaia da; gatazkaren ondorioak, guztiak, argitu eta orbainak ondo isten saiatzeko denbora da, auzi politikoari oinarritik heltzeko unea da; euskal gizarteari, askatasunari, demokraziari aukera berriak irekitzeko etapan gaude; euskal jendarteak behar duen elkarbizitza demokratikoaren esparrura irits gaitezen.

Hori izango da gure ekarpena. Agertoki berriaren aldeko apustua sendotzea.

IrtenBidera, Demokrazia, Etorkizuna
Euskal Herrian, 2021eko udaberrian

# Mobilizazioak

MARTXOAK 13
## Angel Berruetaren omenez
17 urte bete dira espainiar polizia batek eta bere semeak Angel Berrueta iruindarra hil zutenetik. Angel Gogoan plataformak gogora ekarri nahi izan du hilketa hark irekitako zauria oraindik ez dagoela itxia. «Pandemia egoera honetan, segurtasunagatik eta errespetuz jokatzearren, omenaldia modu ez presentzialean egitea erabaki da». Hala ere, «betiko maitasunarekin, gure lagun eta auzokidearen omenez» abesti bat kaleratu du plataformak.

MARTXOAK 21
## Mobilizazioa Baionan
Ion Kepa Parot preso politiko baionarrak Covid-19an positibo eman du eta bere askatasuna galdegiteko mobilizazioa burutu dute Baionako suprefetura aurrean.




MARTXOAK 21
## Joseba Arregi askatu
Oñatiko Sarek Martuteneko espetxe atarira eraman du Joseba Arregi askatzeko aldarrikapena. 75 urte beteko ditu preso politiko oñatiarrak eta horietatik ia 30 eman ditu espetxean.

MARTXOAK 21
## Plazak bete, motxilak hustu
Sarek eta Irati Gurasoekin Euskal Herrira dinamikak 88 motxiladun umeen eskubideak bermatuak izan daitezen ekimenak burutu dituzte Bilbon, Ondarroan, Orion, Zumaian, Zornotzan, Durangon, Larrabetzun, Urduñan, Ugaon, Ordizian, Algortan eta Amurrion.

MARTXOAK 26
## Antonia Hernandezen oroimenez
Etxerat elkarteak dispertsioak erraildako Antonia Hernandez oroitu du Algortan. Angel Figeroa bere loba presoa bisitatzera joan zen orain 24 urte Antonia eta ez zen inoiz bueltatu.

MARTXOAK 26
## Azken ostirala
Etxeratek eta Sarek mobilizazioak egin dituzte herrietan eta hiriburuetan, presoei aplikatzen dieten salbuespen egoera salatzeko.

MARTXOAK 28
## "Unai etxeratzeko bidea gara"
Izen bereko dinamikak deituta, Unai Paroti aplikatzen dioten "estatu ankerkeria" salatu eta bere etxeratzea exijitzeko manifestazioa egin dute Arrasaten.

MARTXOAK 28
## Korrika
AEKk 80 ekitaldi baino gehiago egin ditu, aurten ospatu beharreko baina ospatu ezinik gelditu den Korrika amaituko litzakeen egunean. 2022ko martxoaren 31etik apirilaren 10a bitarte 22. Korrika ospatuko dela iragarri dute.

APIRILAK 4
## Aberri Eguna
Euskal Herria Batera dinamikak deituta milaka pertsona atera dira. Aurten deialdia balkoietatik plazetara igaro da eta "Txoria txori", "Gernikako Arbola" eta "Ikusi Mendizaleak" abestu dituzte.



APIRILAK 7
**Osasunaren Nazioarteko Eguna**
Osasunaren Nazioarteko Egunean gaixo dauden presoak askatzea aldarrikatu dute Etxeratek eta Sarek. Gauzak horrela, "espetxe politika gizatiartzeko pausoak eman behar direlarik, gaixotasun larriak dituzten 17 euskal preso politikoak berehala askatzeko eskatu dute beste behin, duten gaitza baldintza duinetan artatzeko, haien senideen ondoan, eta haien osasunaren eskubidea errespetatua izan dadin".

APIRILAK 10
**Izan Bidea deiadarmendietan**
Izan Bidea dinamikaren baitan ehunka lagun bildu dira Bizkaiko deiadar mendietan.

APIRILAK 10
**Extradizioa salatuz Donostian**
Gros auzoko lagunek elkarretaratzea egin dute Ander Mujika auzokidea, estatu frantseseko zigorra bukatutakoan, estatu espainolera extraditatuko dutela salatzeko.

APIRILAK 17
**Preso Politikoen Nazioarteko eguna**
Sortuk milaka lagun atera ditu Hego Euskal Herriko lau hiriburuetako kaleetara, "Askatasuna" lemapean. Euskal presoak etxera ekartzea ahalbidetuko duten konponbide politikoak eskatu dituzte bertan.



APIRILAK 23
**Sindikatuak Izan Bidearen parte**
Presoen hurbilketaren alde eta euskal presoei legedi arrunta aplikatzearen aldeko deklarazioa babestu dute LAB, ELA, UGT, ESK, Steilas, CGT, CNT EHNE, Hiru eta Etxaide sindikatuek, Bilbon egindako mobilizazio batean.

APIRILAK 25
**Jokin Gorostidiren omenez**
Ezker Abertzaleak Jokin Gorostidi omendu du, bere heriotzaren 15. urtemugan, Tolosan.



APIRILAK 27
**Atxiloketen aurka**
Espainiako Poliziak hamar gazte atxilotu ditu Nafarroan, bederatzi Iruñeko Arrotxapea auzoan eta beste bat Burlatan. Arrotxapean elkarretaratzea egin dute eta 400 lagun inguru elkartu dira.

APIRILAK 30
**Azken ostirala**
Etxeratek eta Sarek azken ostiraleko mobilizazioak egin dituzte salbuespen legedia salatuz eta lehenbailehen etxera etor daitezen eskatuz.

MAIATZAK 1
**Langileen Nazioarteko eguna**
"Aldaketa da aukera. Por un cambio de rumbo" lemapean LABek 25 mobilizazio baino gehiago egin ditu Hego Euskal Herrian. Iparraldean LABek beste erakunde sindikalekin batera deitu du mobilizaziora. Garbiñe Aranburu LABeko Idazkari Nagusiak bere hitzartzean "hemen egon ezin duten baina beti gurekin dauden euskal preso politikoei besarkada gorri iraultzailea" bidali die.

MAIATZAK 7
**"Larrialdi egoeran gaude"**
Ernaik gazte antolakundeak mobilizazioak burutu ditu Hego Euskal Herriko hiriburuetan. Gazteek pairatzen duten prekarietatea salatzeko eta etorkizun ezaren aurrean eraldaketa soziala eta burujabetza aldarrikatzeko atera dira kalera. Ertzaintza gogor oldartu da gazteen aurka eta 8 atxilotu eta 65 zauritu eragin ditu.



MAIATZAK 8
**650 tontorretako erronka**
Sarek eta Bake Bideak deituta, Euskal Herriko 650 tontorretara igoerak egin dituzte milaka herritarrek. "Inoiz baino garrantzitsuagoa da kalean konponbidea eta presoen etxeratze prozesua garatzeko nahia azaleratzea, gehiengoaren nahia. Bultzada hori gabe ez baita sekula etxerako bidea burutuko» adierazi dute antolatzaileek.



MAIATZAK 9
**EH Bilduko Kongresua**
Urtarrilean abiatutako II. Kongresua ixteko ekitaldia ospatu du EH Bilduk Barakaldoko BECen. Bertan militantziaren sostengu zabala jaso duen Hegoaldeko zuzendaritza osatzen duten kideak aurkeztu dituzte.

MAIATZAK 15
**Free Palestine**
Palestinaren aurkako Nakbaren 73. urtemugan, Hego Euskal Herriko hainbat plataformak mobilizazioak antolatu dituzte Israelen sarraskia salatzeko eta Palestinarekin elkartasuna adierazteko.

MAIATZAK 23
## Nafarroa Berriz Altxa

Nafarroako Artxibo Orokorraren aurrean Nafarroa Berriz Altxa iniziatibak jendea bildu du jai-ekitaldi batean. 1521eko Iruñeako populazioaren altxamendutik 500 urte betetzen direnean, orduko espainiar inperioaren ezkutuaren gainean egin dute dantza. Ariketa nostalgikoa baino, balore politikoa eta gaurkotasun osoa dituen ariketa bezala aurkeztu dute; izan ere, nork erabakitzen duen eta erabakiak non hartzen diren sakoneko arazoak segitzen baitute izaten.




MAIATZAK 23
## Izadi gurasoekin etxera

Ehunka pertsonak hartu dute parte Burlatan egindako kalejira batean, non Maria Lizarragaren, Iñigo Gutierrezen eta euren alaba den Izadiren askatasuna aldarrikatu duten.



MAIATZAK 28
## Azken ostirala

Etxeratek eta Sarek milaka lagun atera dituzte kaleetara eta plazetara. Osasun pandemiagatik komunikazioetan dituzten zailtasun eta oztopoak salatzeaz gain, dispertsio politikak eragindako sufrimendua onartzeko eta erreparatzeko garaia dela aldarrikatu dute.




MAIATZAK 29
## Euskarak murgiltzea behar du

10000 lagunetik gora bildu dira Baionako kaleetan Frantziako Konstituzio Kontseiluaren erabakia gaitzesteko eta euskarak behar duen murgiltzea aldarrikatzeko.



MAIATZAK 29
## Pentsiodunak kalean

Milaka lagunek parte hartu dute pentsiodunek Hego Euskal Herriko hiriburuetan deitutako manifestazioetan. Pentsio publiko eta duinak aldarrikatu zituzten eta mesfidati agertu dira Madrilen Espainiako Gobernuaren, patronalaren eta Espainiako sindikatu nagusien arteko negoziazioek izan dezaketen emaitzaz.



MAIATZAK 29
## Euskal Herria, harrera herria

Diakité, Etorkinekin, La Cimade, Bizi! eta Irungo Harrera Sareak deituta, migrazio politika arrazistak salatu dituzte Irundik eta Hendaiatik ateratako eta Santiago zubian elkartutako milaka herritarrek. Hitzetatik ekintzetara pasatzeko eta benetako gizarte eta harrera politikak bultzatu ditzatela eskatu dute.

MAIATZAK 30
## Ezohiko Ibilaldia

Osasun egoerak baldintzatuta Sopelako Ander Deuna eta Leioako Betiko ikastolen aldeko Bizkaiko ikastolen jaia ospatu da. Ekitaldian 2022ko Ibilaldia antolatzeko lekukoa eman zaio Bilboko Abusu ikastolari.

MAIATZAK 30
## Debagoiena ibilian

Izan Bidea dinamikaren baitan bizikleta martxa egin dute Oñatitik Elgoibarrera 60-80 txirrindularik. Lore eskaintza egin diete Joseba Arregi eta Sebas Etxaniz preso adinduen senideei, eta deportatuta dagoen Josu Larizen eta gaixo dagoen Gotzon Telleriaren senideek ere jaso dute omenaldi hori, bizikleta martxaren bukaeran egin duten ekitaldian.



EKAINAK 1
## Bizikidetzaren aurkako erasoa salatuz

ETAren biktimen omenezko memorialak ireki ditu ateak Gasteizen eta gune horren edukiari eta helburuari desadostasuna erakusteko ehunka herritarrak bildu dira Gasteizko Foru plazan egindako elkarretaratze batean. Memoria Osoa sareak (Euskal Herriko elkarte memorialista ugari elkartzen dituen sarea) protestara deitu zuen “biktimen memoriala”k duen ikuspegi diskriminatzaile» eta bizikidetzaren aurkako erasoa delako.

Etxerat

etxean nahi ditugu

# UDAKO MATERIALA

## OSAGARRIAK









EGIN EZAZU ZURE EROSKETA HELBIDE HONETAN ETA ETXERA BIDALIKO DIZUGU

**WWW.SERIGRAFIA.EUS/SHOP/ETXERAT**

EDO ATERA ARGAZKIA QR KODEARI ETA DENDARA ERAMANGO ZAITU



Euskal Preso eta Iheslari Politikoen
Senide eta Lagunen Elkartea




APIRILAREN 17A PRESO POLITIKOEN NAZIOARTEKO EGUNA DELA GOGORATZEN DUGU. HARI HORRETATIK, EUSKAL PRESO POLITIKOEI ETA HAIEN EGOERARI BEGIRADA BAT EMAN NAHI IZAN DIOGU. ATZERA BEGIRA EGITEA EZINBESTEKOA DA, DENBORAN ASKO LUZATZEN DEN ETA ORAINDIK INDARREAN DAGOEN SALBUESPENEZKO ESPETXE POLITIKARI ERREPARATZEKO. BAINA ORAINARI ETA ETORKIZUNARI EZARRI DIOTE BEGIRADA ETA ARRETA RUFI ETXEBERRIA SORTUKO GATAZKAREN KONPONBIDEAREN ARDURADUNAK ETA OIHANA GARMENDIA PRESOEN BATZORDEKO ARDURADUNAK.


Rufi Etxeberria Arbelaitz



Oihana Garmendia Marín

"Estatu espainiarreko estamentuek eta klase politiko eta mediatikoaren gehiengoak irabazle eta galtzaileen eskema aplikatzea erabaki zuten. Funtsean hori dago indarrean orduz geroztik"

**Ezer baino lehen egungo egoeraren argazkia egiteko eskatu nahi dizuet. Asteroko albiste bihurtu dira presoen gerturatzeak. Politika aldaketa bat egon da estatuen aldetik?**

**OIHANA** Bai, nabaria da aldaketa bat eman dela, bai estatu frantsesean baita espainolean ere. Baina argi utzi nahi dugu kontu bat: politika aldaketa eman da, baina estatuen aldetik ez dago inolako borondaterik gatazkaren ondorioak modu ordenatu eta iraunkor batean gainditzeko. Borondaterik ez dago eta guri behar hori sortzea dagokigu. Gogoratu behar dugu 2018ra arte, presoen auzian, estatu biak tematuta zeudela presoen gaia gerra koordenadetan kudeatzen segitzeko, garaituen eta garaileen eskema ezarri asmoz. Euskal gizartearen mobilizazioari esker, alderdien zein gizarte mugimenduen artean eraiki diren adostasunei esker eta ezker abertzaleak baita Kolektiboak eman dituzten pausuei esker estatuen blokeoa haustea lortu dugu. Salbuespen politika arintzen ari dira, euskal gizarteak inola ere onartzen ez duen salbuespen legedi hori humanizatzen ari dira. Orain hiru urterekin alderatuta argazkia aldatu da erabat: urrunketaren bukaera ikusten ari gara, graduen politika aldatzen ari da, preso gehienak bigarren graduan baitaude. Baina asko dago egiteko oraindik, humanizazioaren fasetik erresoluzioaren fasera igaro behar dugu eta.

**Frantziarekin interlokuzio publiko bat izan da azken urteetan, bere gora beherekin, Espainiarekin antzekorik izateko aukerarik izan da?**

**RUFI** Gobernu frantziarrarekin, bai, 2017ko urrian ekin zitzaion mintzaidetza publikoari eta hala Pariseko Lan Esparrua eratu zen Justizia ministerioko eta IEHko ordezkaritzen artean. Harreman hori justizia ministro berriak berrartu du duela gutxi eta zalantzarik gabe bitarteko garrantzitsua da presoen aferan urratsak egiteko. Hala izan da hiru urtez eta garapena izatea espero da. Rajoyren gobernuaren erorketarekin etorri zen aldaketa

Estatu espainiarrean eta kontuan izan behar dugu erorketa horretan euskal independentismoak ere parte hartze zuzena izan zuela.

PSOE gobernura iritsi zenean Pedro Sanchez izan zen adierazpen ofizial batean euskal presoekin beste jokabide bati ekingo ziola esan zuena. Urte eta erdian gauza gutxi egin bazuen ere, bigarren hauteskundeen ondoren PSOEk eta Podemosek eratutako gobernuak beste abiada bat eman dio eta esan genezake beste espetxe politika bat garatzeari ekin diola.

Gobernuaren baitako, bere erabakiko eta garapeneko ildoa da. Zentzu horretan frantziar estatuan gertatu denarekin alderatuta Madrilen ez da Lan esparru publikorik eratu, ez da harreman publikorik eman presoen aferaren bueltan. Hori bai, etengabeko mugimenduak ematen ari dira.

**Baina EH Bilduk presoen auzia Madrilen egiten duen politikaren ardatzetako bat dela dio, eta Pedro Sanchez sustengatzen duen hanketako bat da ezker independentista...**

**RUFI** Ukaezina da egoera berri bat irekitzen ari dela euskal preso politikoekin eta hori testuinguru esanguratsu batean ematen ari da, non ezkerreko independentismoak posizio politiko erabakigarria duen Madrilgo Kongresuan. Hori, jakina, datu kualitatibo bat da eta euskal preso politikoei hamarkadetan aplikatu zaien estrategia amaitu dadin bitarteko eta kontrapisu politiko garrantzitsua.

Baina, egiari zor, euskal preso politikoekin eman diren urratsak legedian jasotzen dira, izan ere, presoek eskubide osoa baitute beren sorterriko espetxeetan egoteko eta bigarren graduan beharko zuketen guztiak beren jokabidearen arabera. Ez da akordio politikorik behar gobernua egiten ari dena egiteko. Eta neurri berean, falta diren korapilo batzuk askatzeko ez litzateke akordio politikorik beharko euskal preso politikoei egoera berri honetan soilik legedi arrunta aplikatzeko, eta ez litzateke akordio politikorik beharko Estatu frantziarrean betetako zigorra Estatu espainiarreko zigorrei batzeko. Euskal preso politikoen aurka "*ad hoc*" egindako salbuespeneko legediarekin eta espetxe politikarekin amaitu behar da. Hori da espainiar gobernuak hartu eta gauzatu behar duen erabaki politikoa.

## Aiete

**Pasa dira 3 urte ETAren desagerpenetik, 4 urte armagabetzetik eta 10 Aietetik. Kofi Annan, Bertie Ahern edo Jonathan Powell Donostian, nazioarteko goi mailako ordezkaritza bi estatuei gatazkaren ondorioen auzian engaiatzeko eskatuz. Ez zuen erantzun baikorrik izan eta akabo, ez aurrera ez atzera, adibidez, preso eta iheslarien auzia...**

**RUFI** Aieteko Adierazpenaren helburua Euskal Herrian bake prozesu bat erdiestea zen. Horri zuzenduta egin zituen bi deialdi nagusi. ETAk berea bete zuen. Bi estatuetako gobernuek muzin egin zioten gatazkaren ondorioei irtenbide ordenatu bat emateko saiakeran sartzeari.

Bi Estatuetako gobernuek muzin egin zioten nazioarteko bitartekariek batetik ETArekin eta bestetik PSOEren gobernuarekin hartutako konpromisoak betetzeari.

Aieteko Konferentzia eta Adierazpena nazioartean gatazkak konpontzeko erabili izan diren formuletan inspiratuta zegoen. Bake prozesu bat abiatzea eta berriro ez errepikatzeko oinarriak jartzea zuen helburua.

Estatu espainiarreko estamentuek eta klase politiko eta mediatikoaren gehiengoak irabazle eta galtzaileen eskema aplikatzea erabaki zuten. Funtsean hori dago indarrean orduz geroztik. Ondorioz, Aieteko Konferentziak bake prozesua eraikitzeko tresnak eskaini bazituen ere, Euskal Herrian ezin izan da halakorik garatu. Baina norabide propio bat eman zaio, batez ere euskal eragile sozialen eta euskal jendartearen konpromisoaren eskutik.

Estatuen parte-hartzearekin garatu ezin den bake prozesuaren aurrean Euskal Herrian (Iparraldean eta Hegoaldean subjektu eta testuinguru desberdinetan) elkarbizitza demokratikorako esparrua irekiko duen prozesua jorratzen ari da eragile anitzen eta euskal jendarteko eremu zabalen borondateak bilduz. Eskubide guztiak euskal herritar guztientzat oinarritzat hartuz. Hor kokatzen da ondorioen konponbidearen aldeko ahalegin erraldoia.

Elkarbizitza demokratikora heltzen laguntzeko ezinbestez bideratu beharreko afera da euskal preso, iheslari eta deportatuena, guztien etxeratzea hain zuzen. Elkarbizitza eraikitzeko arrazoi politikoengatik preso, iheslari edo deportaturik gabeko euskal jendartea behar dugu.

## EPPK eta EIPKren ekimena

**Kronologietan sartuta, 2013an EPPKk egin zuen eztabaidaz galdetu nahi nizueke, ordura arteko bide baten aldaketa nabarmena suposatu zuen, Sorturen ustez zer aukera ireki ditu bide hark?**

**OIHANA** Aurreko konfrontazio armatuko zikloan Kolektiboa gehienbat erresistentzia posizioetan mugitzen zen, estatuetako errepresioari aurre egiteko posiziorik eraginkorrena zelako. Aieten zabaltzen den prozesu politikoa aintzat hartuz, 2013an Kolektiboak agertoki berrira egokitu eta pisuzko gogoetak partekatu zituen euskal gizartearekin. Herri honetan bakea eta justizia helburu zituen prozesu sendo bat abiatzeko ekarpena egin zuen; alde batetik, gatazkaren ondorioak gainditzeari begira, baina baita ere gatazkaren iturburua modu iraunkor eta justu batean gainditzeari begira.

Gogoeta eta ekarpen horien artean, legalitate penitentziarioa onartzea eta erabiltzea erabaki zuen,

beti ere kaleratzeko perspektibarekin. Estatu espainolak errepresioarekin erantzun zuen eta presoen defentsan aritzen zen guztia kriminalizatu nahian aritu zen. Baina Kolektiboa ez zuten desbideratu helburu horietatik eta 2013ko gogoeta 2017ko eztabaida prozesuan hezurmamitu zen.

Estatuek prozesu politikoa espetxeetan blokeatu nahi zuten, euskal preso politikoak prozesu politikoaren gatibu bezala erabiliz, baina Kolektiboak jakin izan zuen egoera hori gainditzen eta oztopo guztien gainetik euskal gizartearekin batera eta aldebakartasunetik espetxeak hustutzeko eskema berritu bat arakatzen.

**Iheslarien kolektiboak ere abiatu zuen ekimen propioa, zein da prozesu horren emaitza?**

**RUFI** EIPKak, Lizarra-Garazi prozesuaren garaian Euskal Herrian abian jarri nahi zen nazio eraikuntzarako eta eraiki nahi zen normalizazio politikorako, ekimen propioa garatzeari ekin zion eta hala “etxeratze” dinamika martxan jarri zuen.

Abiapuntu horretan oinarrituta, Ezker abertzalearen estrategia aldaketak sortutako egoera berrian EIPKak askapen prozesua indartze bidean urte batzuk lehenago abian jarritako “etxeratze” ekimena berrindartu zuen. Horra zuzenduta egin zen 2014ko ekainean Biarritzen eta 2015ean Arrangoitzen adierazpen bana.

Lizarra-Garaziko garaitik gaurdaino ia 200 iheslari itzuli dira Euskal Herrira, horietatik 35 deportatuak izandakoak.

Oraindik orain, jakina, arrazoi politikoengatik ihesean eta deportazioan dauden euskal herritarrak etxeratzea helburu izaten segitzen du, presoekin batera itxi beharreko afera baita herri honetan elkarbizitza demokratikorako oinarriak jarriko baldin badira.

**Zenbat iheslari daude?**

**RUFI** Egun 34 iheslari eta 8 deportatu daude munduan zehar barreiatuta. Horietako asko Entzutegi Nazionalaren jokabide ertsi eta tranpatiaren eraginez ez dira itzuli Euskal Herrira, izan ere, Entzutegi Nazionalak uko egiten baitio bakoitzaren egoeraren berri emateari eta horrezaz gain bakoitzaren kausen preskripzioaren erabilpen maltzurra egiten du.

## Argazkia

**Preso kopuruari begiratzen badiogu jaitsiera nabarmena eman da, baina zein egoeratan daude espetxean jarraitzen duten 200dik gora euskal herritarrak?**

**OIHANA** Gaur egun EPPKko 213 preso politiko daude bi estatuetan. Estatu frantsesean gizonezkoak EHtik gertuko espetxeetan aurkitzen dira, emakumeak, aldiz, bataz beste ia 900 kmra urrunduak, borondatea izan arren, ez dagoelako azpiegiturarik gerturatuak izateko. Aldiz, estatu frantsesak ez dauka borondaterik prozesu integral bati ekiteko, eta presoen kaleratzea ez dago bere agendan. Hala, oztopoak aurkitzen ari dira presoak kalea zapaltzeko ordua iritsi behar denean: Jakes Esnal eta Jon Kepa Paroten askatasun eskaerei ukazio sistematikoa emanez, nahiz eta 31 urte daramatzaten preso. Xistor Aranbururi baldintzapekoa onartu arren, 18 hilabetez etxean preso egon beharko du.

Estatu espainolean aldaketa nabaria ikusten ari gara. Gaur gaurkoz, 185 preso daude. Orain urte batzuk denak lehenengo graduan eta Euskal Herritik oso urrun zeuden (gehienak Andaluzian, Galizian edo Levanten), eta, gobernuak markatu duen martxa segituz gero, laster denak Euskal Herriko edo inguruko kartzeletan egongo dira, eta bigarren graduan, hau da, erregimen ordinarioan.

Aldiz, kalean egon behar luketen preso askok preso segitzen dute. Europako lege markoa ez aplikatzeko Espainiak legea bihurritu zuen eta euskal presoei beste estatu batean betetako zigorrak estatu espainoleko zigorrekin ez batzeko formula juridiko berri bat asmatu zuen. Espainiako Transposizio horrek 50 kideri eragiten



die, eta horietatik 11 kalean egon beharko lirateke. Argazkia osatzeko, esan behar dugu euskal preso politikoei espetxe zigorrak luzatu egin dizkietela, legalki eta alegalki. Gogoratu besterik ez dugu behar Parot doktrina edo zigorrak batzeko lege europarrari egindako iruzurra, baita lege ordinarioak ahalbidetzen duen erredentzioen lorpena, irteera baimenak eta, ondorioz, baldintzapeko askatasunaren ukazio sistematikoa. Euskal presoei zigorrak luzatzen dizkiete erabaki politikoetan oinarrituta.

**Argazki horretan, lehen gradua eta isolamendua elementu garrantzitsuak izan dira orain dela gutxira arte. Gaur egun, isolamenduan ez dago presorik, hor al dago aurrerapausu bat?**




**OIHANA** Lehen aipatu dugun moduan, hamarkadetan mantendu duten politika kriminala humanizatzen ari dira. Lehenengo graduan zeuden preso asko isolamenduan mantentzen zituzten kartzela askotan, nahiz eta gradu horri zuzenki ez egokitu isolamendua. Isolamenduaz momentuz iraganean hitz egin behar dugu, egoera horretan mantentzen zituzten kideak hortik atera baitituzte azken hilabeteotan. Nazio Batuen Torturaren aurkako Batzordeak isolamendua denboran luzatua tortura dela adierazi du eta pertsona bat isolamenduan 15 egunetan baino gehiagotan ez egotea gomendatzen dute. Hemen, egoera kriminal horretan urteak eta urteak pasa dituzte kide askok, hamarkadak batzuen kasuan. Orain ikusi dugu nola Huelva, Sevilla, Puerto, Estremera edo Sotoko isolamendu egoerei bukaera eman dieten, baina eszenatoki berri honetan eutsi ezina zen egoera bati bukaera baino ez diote eman.

**Zer fruitu eman du legearen bidea jarraitzeak, edo zuzenago esanda, legeak ematen dituen aukera guztiak baliatzeak?**
**RUFI** Lehen lehenik, esan beharrekoa da euskal preso politikoak legediaz beti baliatu izan direla beren eskubideen defentsan. Dozenaka kasu irabazi ziren lurralde ezberdinetako Zaintza Epaitegietan eta justu egoera horrek eraman zuen gobernu espainiarra euskal preso politikoentzat bide juridikoaren aukera itotzera, nola eta Zaintza Epaitegi Zentraleko Epaile bakar bat izendatuz.

"Egun 34 iheslari eta 8 deportatu daude munduan zehar barreiatuta."

Orduz geroztik oraindik eta inpunitate handiagoz aplikatu izan zaizkie era guztietako neurriak euskal preso politikoei. Epaitegi Zentrala erabaki politikoz sortua eta erabaki politikoak hartzeko izendatu zen, eta hala jokatu du eta jokatzen segitzen du salbuespeneko irizpideak babesten.

2013az geroztik EPPKko kideek daramaten ildo juridikoak hiru gauzetarako gutxienez balio izan du:

Batetik, Euskal Herriko eremu sozial, sindikal eta politiko zabalarekin elkartzeko bide honen garapena partekatzen. Bestetik, aplikazio arbitrario eta sistematikoak agerian jartzeko. Hor dago lehenengo graduaren aplikazioa. Hirugarrenik, ekindako ildo juridikoa amaieraraino eramanez hartutako bidearen balioa frogatzeko. Horrela izan da zenbait kidek egindako ibilbidea baimenekin hasi eta etxean askatasunean geratu arte.

**... Eta horrek eragin du erreakziorik? Alegia, legezko bidea egiteak eragin du bide hori zailtzea edo oztopo berriak sortzea?**

**OIHANA** Zuzenean, espetxeetan presoak lege penitentziarioa etxeratzeko helburuarekin hasi direnean, oztopoak topatzen hasi dira. Lehen presoei legea erabiltzeko exijitzen zieten horiek orain bidea oztopatu nahian dabiltza. Hala, ikusten ari gara espetxe batzuetako Batzorde Teknikoak eta Tratamendu Batzordeak iraganeko koordenadetan murgilduta daudela eta, nahiz eta presoek bidea egiteko baldintzak bete, kontrako jarrera agertzen dute irteera baimenak edo gradu aldaketak proposatzerako orduan. Ekipo teknikoez eta Tratamendu Batzordeez gain, fiskaltza eta Espetxe Zaintzako Epaitegi Zentrala eskema horretan murgilduta daude, eta Espetxe Administrazioak gradu aldaketak, erredentzioak edo irteera baimenak onartu arren, kasu batzuetan, fiskalak helegitea jarri eta epaileak ukatu egin dizkie eskubide horiek presoei. Azkenik, Audientzia Nazionaleko zigor aretoan dugu arazoa, areto honetara heltzen diren auzi guztiak atzera botatzen baitizkiete. Sumatzen ari gara, hor ere, estatu sakona lanean dabilela doktrina berri bat ezarri nahian.

**Zer fruitu gehiago eman dezake?**

**OIHANA** Berez, legedi arruntak etxe atariraino ekarri beharko lituzke gehienak. Baina salbuespen lege eta praktika bat aplikatzen ari zaie euskal preso politikoei eta etxerako bide hori ezintzen diete gehienetan. Euskal Herrian ETAren desagerpenarekin eta ezker abertzaleak egindako eskaintza demokratikoarekin fase berri bat zabaldu dela ukaezina da. Zentzu horre-



tan, egoera berriari egokitu behar zaio espetxe politika eta salbuespenezko arkitektura legal eta paralegal guztiak bertan behera gelditu behar dira. Izan ere, legeak ez baitu jasotzen preso politikoei aplikatzen dieten salbuespenezko praktika. Inertzia horiek ere desaktibatu behar dira.

## Aurrera begira

**EPPKk eman dituen urratsak ez direla nahikoak diote, barkamena eskatu beharko luketela presoek**

**RUFI** EPPKk, Ezker abertzale osoak bezala, egina du bere gogoeta propioa konfrontazio armatuaren garaian eragindako minaz eta baita plazaratua ere Euskal Herriko jendartearen, biktima ororen eta nazioarteko komunitatearen aurrean. Horrezaz gain, EPPKko kide gehienek idazki pertsonala egina dute, ekimen propioz eta ez baldintzarik onenetan, eta espetxe administrazioan aurkeztua bide politiko eta demokratikoen alde, eragindako mina aitortuz eta biktimen sufrimenduarekiko enpatia adieraziz.

Presoek eta Ezker abertzaleak jarrera zintzo bezain eraikitzaileaz jokatu dute eragindako mina eta kaltea aitortuz. Hau da, euskal preso politikoek jada egina dute sakonera duen adierazpen politikoa eta adierazpen etikoa. Esana dute prozesu independentista bide baketsu eta demokratikoetatik garatuko dutela, baztertzen dutela ekinbide armatua eta aitortua dute eragindako mina eta adierazia biktimen sufrimenduarekiko enpatia. Beraz, politikoki eta etikoki sakontasunez eta zintzotasunez eginda dago.

Hortik aurrera edozer eskatzen delarik soil-soilik interes politiko makurren baitakoa da. Irabazle eta galtzaileen eskema perbertso horretan alde batekiko mendeku nahia, birrindu nahia besterik ez dago. Hor kokatu behar da hitz zehatzen erabilerara behartu nahia. Ez du zerikusirik ez adierazpenaren balio politikoaren faltarekin, ez adierazpenaren zintzotasun ezarekin. Eta gauza jakina da behartuta egindakoa, hori baino gehiago ez dela, egitera derrigortua edo bortxatua izan denarentzat eta lekuko izan den jendarte ororentzat.

**Argitu gabeko hilketez ere mintzo dira...**

**RUFI** Lehen lehenik Euskal Herrian biolentzia ezberdinek utzi dituzten ondorioetan argitu beharreko kasuen errealitate osoa zein den agerian jarri beharko litzateke. Iritzi publikoan etengabe agertzen den zenbakia ETAren argitu gabeko kasuei dagokiena da. Baina ez dira horiek argitzeke dauden bakarrak. Hor daude, besteak beste, estatuaren bultzadaz antolatutako talde parapolizial ezberdinek eragindakoak, polizia indar ezberdinek eragindakoak edota milaka torturatuak.

Bestetik, ETAren eraginaren ondorioak argitzea exijitzen denean zer bilatzen da? Egia ezagutzea edo mendekua nahi da? Biktimen erreparaziorako aitortza eta egiaren ezagutza edo urte luzetako zigorrak erakarriko lituzketen prozedura judizialak abian jartzea? Alde baten sufrikarioa beste hiru edo lau hamarkadaz luzatzea da helburua? Adierazle politiko, judizial, polizial eta mediatiko guztiek hori adierazten dute.

Honen guztiaren aurrean bide eraikitzailea bilatu behar da, euskal jendartean iraganean gertatutakoak zauri eta sufrikario gehiago eragingo ez duen bidea. Bide edo formula horren helburuak biktima guztien erreparaziorako garrantzitsua den gertatutakoaren egia ezagutzea eta berriro ez errepikatzeko oinarriak jartzea lirateke.

Ezker abertzalea prest legoke gure herrian gertatu den guztiaz mintzatzeko. Hori bai, guztiaz mintzatzeko guztion partaidetza behar da eta baldintzak adostu behar dira. Goazen Egiaren Batzorde bat eratzera. Egin dira mundu mailan halakoak, badugu zer begiratu gurera egokitzeko. Baina ez da nahikoa alde bat bakarrik prest egotea herri honetan gertatu denaz mintzatzeko, alde guztien presentzia behar da, gertatu den guztia argitara ateratzeko. Egiaren Batzordea horretarako tresna ezin baliagarriagoa izango litzateke.

Euskal Herrian Egiaren Batzorde bat sortzeak eta gatazkaren zio eta ondorioak era integral batean jorratzeak bere biziko ekarpena egingo lioke euskal jendarteak behar duen elkarbizitza demokratikorako esparrua eraikitzeko prozesuari.

**Hainbat espetxe euskal preso politikorik gabe geratuz joan da azken hilabeteotan, hustuko dira erabat kartzelak arrazoizko epe labur-ertain batean?**

**OIHANA** Basakeriaren eta euskal presoen eskubideen urraketaren ikurrak izan diren espetxe batzuk euskal presorik gabe gelditu dira (Herrera de la Mancha, Huelva, Badajoz, Cordoba.... eta espero dezagun laster Puerto de Santamaria,...), herri honen historian iltzatuta geldituko diren izenak. Baina hustutze horiek ez dira izan presoak askatu dituztelako baizik eta EHko inguruko espetxeetara eraman dituztelako. Helburua espetxe guztiak euskal militantez hustutzea da. Norabide horretan, legedi arrunta aplikatuz gero, 168 presok kalea zapaltzen egon beharko lukete, zigorraren laurdena beteta izatean irteera baimenak disfrutatu beharko lituzketelako.

Horietatik, 134 presok zigorraren erdia beteta dute eta hirugarren graduan egon beharko lirateke, eta areago, horietatik 63 kidek zigorraren hiru laurdenak beteta dituzte eta baldintzapeko askatasuna egokituko litzaieke. Hori da espetxe legediak ezartzen dituen baldintzak eta guk errespetatzeko eskatzen ditugunak: zigorraren laurdena beteta dutenek irteera baimenak izatea, zigorraren erdia beteta dutenak 3 gradura progresatzea eta zigorraren hiru laurdenak beteta dituztenentzako baldintzapeko askatasuna azkartzea.

Hala eta guztiz ere, jakitun gara legedi arruntak ez diola erantzuten oraindik zigor luzeak bete behar dituzten presoen etxeratzeari. Kondena luzeak dituzten presoentzat legea egoera berrira egokitzea aldarrikatzen ►

"...euskal gizartean heldutasun eta borondate nahikoa dago aurreko zikloa behin-betiko ixteko. Beraz, elkarrizketaren bidez eta adostasunen bidez, presoak, iheslariak eta deportatuak etxera ekartzeko bidea urratzen segituko dugu."

dugu, jada existitzen ez den erakunde armatuko kide ohi horientzat nazioartean erabiltzen diren justizia trantsizionaleko formulak bilatzea. Bizikidetza demokratikoa erdietsi nahi badugu pentsaezina da kide batzuk preso segitzea hamarkada luzez. Egoera eta erronka berriei egokitu behar zaie espetxe politika.

Euskal presoen kasuan estatuek legea bera bihurritu dute, Aznarrek esan zuen moduan, "*kartzelan ustel daitezen*". Legalki eta legeak jasotzen ez dituen praktikekin presoei zigorrak urteak edo hamarkadak luzatu dizkiete. Bada garaia salbuespen lege eta praktika horiekin bukatzeko eta mendekuzko makinaria guztia desaktibatzeko.

**Preso denak ez daude kalean, baina egoera asko hobetu denaren, gutxienez, pertzepzioa, badugu... ez da ala?**

**RUFI** Agerian dago, azken urte honetan batez ere, egoera berri bat irekitzen ari dela euskal preso politikoekin. Presoen kokapenaren mapari begiratu besterik ez dago ohartzeko aldaketa esanguratsua ematen ari dela, oraindik denon Euskal Herriratzea falta bada ere. Neurri berean aipatu behar da baita ere preso guztiak bigarren gradura pasatzen ari direna lehenengo graduko aplikazio sistematikoari amaiera emanez.

Egia da hiru hamarkada baino gehiagoko espetxe politika oso krudeletik ia bat-batean edo kolpetik egoeraren humanizaziora pasatzen ari garela. Zenbateko balioa duen urrunketa arintzeak, modulu berezietako bizitzatik, bakartzetik, lehenengo gradutik ateratzeak. Hori horrela da eta azken hiru urte hauetan bi estatuetan itxikeriaren estrategia gaindituz presoen egoeraren humanizaziora iristen ari garen bezala ireki beharko dugu guztion etxeratzeko bidea.

**Presoen eskubideen inguruan eraiki da adostasun zabal-zabal bat Euskal Herrian, aske uztearen alde maila horretako adostasuna egon daitekeela uste duzue?**

**OIHANA** Presoen eskubideen inguruan adostasun eta akordio anitzak bildu izan ditugu herri honetan. Egia da eskubideen inguruko adostasunak urgentzia izan duela, sufrimendu itzela eragiten duen salbuespen politika gainditzeko lehentasunezko afera bat izan delako. Baina euskal gizarteak bizikidetza demokratikoa aldarrikatzen duenean gatazkaren ondorioei irtenbide iraunkor eta justu bat ematea aldarrikatzen ari da. Ziklo baten amaiera eta agertoki politiko berri bat ez dira emango baldin eta presoak eta iheslariak etxean ez badaude. Zentzu horretan, euskal gizartean heldutasun eta borondate nahikoa dago aurreko zikloa behin-betiko ixteko. Beraz, elkarrizketaren bidez eta adostasunen bidez, presoak, iheslariak eta deportatuak etxera ekartzeko bidea urratzen segituko dugu.

Bukatzeko, eta ondorio bezala, azpimarratu nahiko genituzke Kolektiboak markatu dituen premiazko lehentasunak. Lehen urrunketa, preso gaixoen kaleratzea eta lehenengo gradutik ateratzea izan baziren, orain espetxeak hustutzeko mugarriak jarri dituzte: ¼ ak, ½ ak eta ¾ ak, hau da, irteera baimenak, hirugarren graduak eta baldintzapeko askatasunak. Baldintza horiek betetzen dituzten presoei dagozkien onurak eta eskubideak bermatzea, alegia. ●

# Instituzioak, eragileak eta herri ekimenak

MARTXOAK 11

### Zabalzaren kasua ikertzeko

Intxaurrondoko grabazioak argitaratu ondoren, Zabalzaren kasua berriro irekitzea azter dadila eskatu dute Donostiako udal talde guztiek. Udalak guardiako epaitegiari eta Estatuko Fiskaltzari Mikel Zabalzaren kasua berriro irekitzea azter dezatela eta diligentziak irekiz gero, herri akusazio gisa agertzeko konpromisoa ere adierazi dute. Bestaldetik, Nafarroako Gobernuak bere egin du martxoaren lean Nafarroako Parlamentuak egindako eskaera, non Zabalzaren heriotza argitzeko galdegiten zuen.

MARTXOAK 13

### Dispertsioaren ondorioak

Holandako hiru kazetarik Puertoko espetxe inguruan kotxe istripua izan dute, euskal preso politikoei aplikatutako dispertsioaren inguruko erreportaia egiten ari zirelarik.

MARTXOAK 16

### Foro Soziala

Bizikidetza landuz ekimenaren baitan, Foro Sozialak hausnarketa eta elkarrizketarako espazio bat zabaldu du, kulturak Euskal Herriko egoera sozio-politikoan zer paper izan duen, duen eta izan beharko lukeen gogoetatzeko. Ander Zurimendi eta Patxi Zubizarreta idazleek eta David Perez Sañudo idazle eta zinemagileak parte hartu dute Gasteizko hitzordu honetan.

MARTXOAK 19

### Oier Oarekin elkartasuna

Oier Oak bere familiarekin bizitzeko duen eskubidea aldarrikatu dute hainbat eragilek Larresoron. Donostiako preso politiko ohiaren egoera juridikoa konpontzeko eskaerak babes zabala jaso du eta pertsonaia esanguratsuek bat egin dute Larresoroko biztanleek kaleratu duten manifestuarekin.



MARTXOAK 22

### Pasaiako memoria

Pasaiako sarraskiaren 37. urteurrenean Egiari Zor fundazioak eta Pasaian erraildakoen senideek gertatutakoa argitzeko eskatu dute eta hainbat ekitaldiren berri eman dute.




MARTXOAK 24

### Txertaketa espetxeetan

Etxerat elkarteak presoak Covid-19aren kontrako txertaketarako lehentasuneko taldeetan sar ditzatela eta espetxeetako populazio guztiarentzat txertaketa plan eraginkorrak abian jar ditzatela eskatu die Lakua eta Nafarroako gobernuei eta espainiar zein frantziar estatuei.

MARTXOAK 24
### Torturak osturiko bizitzak
Egiari Zor Fundazioak, 1961etik gaur egunera arte, torturengatik erraildako 14 pertsonen errekonozimendua eta egia ezagutzeko eskubidea aldarrikatu du Donostian egindako ekitaldi batean. Fundazioak atera duen bideoan izen abizenekin agertzen dira frankismo garaian hildako zortzi pertsonak eta ondorengo seiak.



MARTXOAK 25
### Espetxe politika eztabaidagai
Sare eta Etxerat elkarteen eskutik, EHUrekin elkarlanean, hitzaldia antolatu dute Bilbon espetxe politikaz aritzeko. Bertan Jose Antonio Martin Pallin, Iñaki Lasagabaster, Patrizia Velez, Joseba Azkarraga, Nahia Aia eta Carlos Hernandez aritu dira espetxe politika humanizatzeko dauden erronkez eta oztopoez.

MARTXOAK 27
### Sareren VI. Asanblada
Donostian bildu diren Sareko kideek urteko balantzea egin eta aurrera begirako erronkez gogoetatu dute.



MARTXOAK 29
### Foro Soziala
Presoen auzia konpontzeko lehen fasea ixteko eskatu dio Foroak Madrilgo gobernuari. Hurbilketa, bigarren gradua eta espetxe eskumenaren transferentzia burutzen denean lehengo fasea itxitzat joko du Foroak eta bigarren faseari begira jarri: gizarteratze ibilbideak, 3º graduak eta 7/2003 legearen korapiloak askatzea, alegia.

APIRILAK 8
### Euskaldunako Adierazpena udaletan
Urrunketarekin amaitzeko eta euskal presoei legedi arrunta aplikatzeko Euskalduna Jauregian egindako adierazpena berretsiko dute udalek. Adierazpenaren mezu nagusia, orain udalerrien babesa jasoko duena, Espainiako Gobernuari zuzenduta dago eta hari helarazi zaio EAEko gizartearen eta adierazpen hau sinatu dutenen babes osoa izango duela, euskal presoei legeria arrunta eta espetxe-politika normalizatua aplikatzeko beharrezko urratsak ematea erabakitzen bada.

APIRILAK 21
### Donostiako udala
Donostiako Udaleko EAJ, EH Bildu eta Elkarrekin Podemoseko taldeek Euskaldunako Adierazpena berretsi dute. Espetxeetako legedi arruntak aurreikusten duena bete dezan eta presoen Euskal Herriratzea eskatu diote espainiar Gobernuari.



APIRILAK 23
### Foro Soziala eta iheslariak
Foro Sozialak iheslari politikoen auzia konponbidearen agendan sartzea beharrezkoa ikusten du. Hala, mahai gainean jarritako sei proposamenak gogoratu ditu: prozedura judizialik ez daukaten edo jada preskribatu diren prozedurak dauzkaten itzulera erraztea; torturaren bidez lortutako testigantzetan oinarritutako akusazioak soilik dituzten pertsonen itzulera bermatzea; justizia trantsizionala baliatuz, irtenbide juridiko bat artikulatzea oraindik ere deportatuentzat; preskribatzear dauden prozedura judizialak errepresio helburuarekin ez erabiltzea; Auzitegi Nazionalak iheslarien abokatuei haien egoera juridikoaren inguruko informazioa ukatzeari uztea; eta presoak, preso ohiak, iheslariak eta deportatuak bake eta normalizazio prozesuan partaide aktiboak izatea.

APIRILAK 27-30
### Dispertsioaren biktimak
Dispertsioak eragindako heriotzen harira, Etxerat elkarteak mozioak aurkeztu ditu hainbat herritan, non hildakoen senideen mina onartu eta dispertsioarekin bukatzeko eskaera jasotzen duen. Hala egin dute Laudion, Pili Arzuaga eta Fontso Isasiren laudioarren heriotzen harira; Getxon, orain dela 24 urte erraildako Antonia Hernandez getxoztarraren kasuan; Otxandion, orain 21 urte zendutako Ruben Garateren kasuan; Ugaon, orain 22 urte hildako Mari Carmen Salbidearen heriotzarekin; Zierbenan, Jose Mari Maruriren kasuan eta Oñatin orain 13 urte hildako Natividad Juncoren heriotzaren harira.




APIRILAK 28
### Osasunaren Munduko Erakundea
OMEk Europako estatuei presoei Covid-19aren kontrako txertoa jartzeko eskatu die, kolektibo honek kutsatzeko duen arriskuagatik. Presoak munduko zein nazioetako txertaketa planetan sartu behar dituztela esan du; osterantzean, Nazio Batuetako presoei begirako oinarrizko arauak urratzeaz gain, gaixotasunaren transmisioa ez da etengo.

APIRILAK 28
### Foro Soziala
Foro Sozial Iraunkorrak Lakuari eskatu dio ekainaren 26an Torturaren Biktimei Laguntzeko Nazioarteko Eguna ospatzeko lana egin dezala, torturaren biktimak modu sinbolikoan aitortzeko eta, bestalde, EAEko Gobernuari eta Nafarroako Gobernuari torturaren biktimei laguntzen jarrai dezatela, eskura dituzten baliabide guztiak haien esku jarriz.

APIRILAK 29
### Etxeraten deia
Senideen elkarteak adierazi du presazkoa eta lehentasunezkoa dela preso guztiak txertatzea, eta ondorioz, lehenbailehen, azken hilabeteetan etendako komunikazio intimoak, familiarrak zein bizikidetzakoak berreskuratzea, berrogeialdiei amaiera emanez.

MAIATZAK 8
### Agur eta ohore, Mixel
Mixel Berhokoirigoin militante eta bakegilea zendu da. ELB sindikatuaren sortzaile, Euskal Herriko Laborantza Ganbararen sustatzaile eta, azken urteetan, bakegileen eragile nagusietarikoa izan da Mixel.



MAIATZAK 10
### Espetxe eskumenen transferentzia
Eusko Jaurlaritzak eta Espainiako Gobernuak espetxeen kudeaketaren eskumenaren transferentzia adostu dute. Orain sinatu bada ere, urriaren 1era arte ez da efektiboa izango. Hortik aurrera, EAEk espetxeetako azpiegiturak eta pertsonala kudeatu ahal izango ditu, legedi penitentziarioa Madrildik ezartzen segituko badute ere.

MAIATZAK 11
### Euskaldunako Adierazpena berretsiz
EAEko 125 udalbatzek berrestu dute euskal presoak hurbiltzearen alde eta aplikatzen ari zaien salbuespen-legediaren ordez legeria arrunta ezartzearen alde 2020ko abenduaren 11n Euskalduna Jauregian aurkeztutako Euskalduna Jauregiaren Adierazpena.



MAIATZAK 13
### Eudel biktimak berbiktimizatuz
Egiari Zor fundazioak salatu du Araba, Bizkaia eta Gipuzkoako udalen elkarteak estatuko biolentziaren biktimak diskriminatu dituela. Euren biktimarioek jasotzen dituzten omenaldien harira adierazpen bat onartzea helburu, Egiari Zor-ek aurkeztutako testua aldatzen saiatu da Eudel. Udalen elkarteak, berriz, testu hori alde batera utzi eta beste testu proposamen bat egin zion Egiari Zor fundazioari. Proposatutako aldaketak ez onartzeagatik ez dela sartu testua Eudelen, eta gainerako biktimen elkarteekin ez dela halakorik gertatzen salatu du fundazioak.



MAIATZAK 15
### Bizikidetza demokratikoa
Foro Sozialak "Bizikidetza demokratikorako konpromiso soziala" eztabaida prozesuari uztailaren 15era arte segida ematea erabaki du, ekarpen gehiago bildu asmoz.

MAIATZAK 23
### Txirrita
Egiari Zor Fundazioak Bernardo Bidaola "Txirrita"ren erailketaren inguruko egia eta aitortza eskatu ditu Tolosan egindako ekitaldi batean. "Ezinezkoa da etorkizuneko elkarbizitza demokratikoa eraikitzea heriotza horiek, eskubide urraketa larri horiek aintzat hartzen ez baditugu, aitortzen eta erreparatzen ez baditugu" adierazi dute.

MAIATZAK 23
### "Ibilian-ibilian, etxerako bidean"
Sarek Izan Bidea dinamikaren baitako udako kanpaina aurkeztu du. Urrira bitartean, eskualdeka mobilizazio ezberdinak garatuko dira eta, elkarri lekukoa pasaz, Donostian izango du amaiera dinamikak, urriaren 23an egingo den mobilizazio nazional batekin.

MAIATZAK 25-26
### Frantziako Asanblean jardunaldiak
"Etsaien artean hitz egin" izenburupean nazioarteko gatazken konponbideei buruzko jardunaldiak burutu dira Frantziako Asanblea Nazionalean. Euskal Herriaren kasua izan dute hizpide, eta negoziazio faseetan izandako gorabeherez aritu dira Josu Urrutikoetxea ETA zeneko kide eta bitartekaria, Brian Currin nazioarteko bitartekaria, Veronique Dudouet Berghof fundazioko zuzendaria eta Caroline Guibet Lafaye filosofo eta soziologoa, Frederique Espagnac senatariaren gidaritzapean. Horrez gain, bigarren egunean Israel eta Palestinako, Kolonbiako, Ipar Irlandako eta Kongoko egoerak aztertu dituzte ere.

MAIATZAK 28
### Presoen aldeko CAFen
Joseba Azkarragak hitzaldia eman zuen CAF enpresan, Beasainen. Hitzaldi hau Euskal gehiengo sindikalak Gipuzkoan abiatu duen kanpainaren baitan kokatzen da.

# El Estado dentro del Estado



Todos los Estados se conforman en una estrecha relación con las características sociales, ideológicas y políticas de quienes los crean. Con el surgimiento de un Estado surge también su *establishment* (la estructura de poder político y mediático que define los parámetros de lo que debe creerse en el país). Cuando se utiliza este anglicismo politológico, nos estamos refiriendo a un grupo de actores que tienen una gran capacidad de influencia en las decisiones y funcionamiento del Estado, conspirando y actuando desde la sombra. En muchas ocasiones, y debido al poder real y de influencia que tienen, actúan como verdaderas fuerzas fácticas, condicionando todos los recursos sociales y políticos de los que este dotado ese Estado. Suelen estar por encima del modelo de Estado, de su practica política, de su pensamiento colectivo, de sus fuerzas sociales, de la justicia.... someten a sus intereses ideológicos, políticos y económicos al sistema que representan y a toda la sociedad. En definitiva, suplantan los intereses colectivos por intereses particulares de personas y de grupos, creando un estado de opinión que hace que sus actuaciones de parte parezcan necesarias en la sociedad. Actuando y condicionando procuran mantener y controlar el orden establecido desde sus propios intere-

ses. Cuando un gobierno no coincide con estos intereses, lo desestabilizan utilizando su poder y las herramientas de que dispone.

La salud democrática en un país es el mejor anticuerpo para los “Estados paralelos”. A menos democracia más engorda ese “Estado profundo”. Los espacios democráticos conllevan control social; los espacios opacos conllevan actuaciones dirigidas a sustentar intereses de parte, llevándose por delante, si fuera necesario el propio sistema democrático. Se puede decir que el “Estado dentro del Estado” en la política española, opera en la mayoría de las ocasiones a cara descubierta. Se sienten impunes porque asumen y sienten que el Estado son ellos. Al mismo tiempo se produce un efecto de simpatía y colaboración entre diversos sectores que refuerzan las actuaciones de la vanguardia operativa del “Estado paralelo”. Este resultado se da, por la posibilidad que hay en los regímenes democráticos de actuar en “redes”, un proceso en el que la sociología social ha realizado numerosos estudios al respecto. ¿Que es una red social? la capacidad de actuar en espacios sociales diversos. Por ejemplo, un médico que trabaja en un hospital y es responsable del área de urgencias, es al mismo tiempo presidente de la asociación de vecinos de su urbanización, ejerce también de médico deportivo en el equipo de fútbol de su hija, y tiene cargos de responsabilidad en su pueblo, en el partido político al que vota. De esta manera se establecen redes de complicidad entre los espacios en los que se interactúa.



En las interioridades del “Estado dentro del Estado” sucede algo parecido. Se establecen redes de conexión entre diversos actores y departamentos. La mayoría de estas relaciones se dan entre espacios y personas ideológicamente afines. De esta manera se facilita las conexiones e interacciones necesarias para que de una forma, que se presenta como *cuasi* natural, se vayan creando los significados que le van dando forma a esos sectores que participan en la actividad del “Estado profundo”.

En el sistema político español, el “Estado dentro del Estado” funciona a todo gas. Todas y todos somos conscientes que hay ciertos temas que son intocables y que si se tocan, los procesos administrativos o judiciales que puedan generar se convierten en una carrera de obstáculos que siempre favorecen a quienes han infringido leyes que tienen vinculación con la vulneración de derechos humanos.

Salvando algunas excepciones, a la clase política española no le produce ningún problema de conciencia observar como personajes ligados al régimen franquista seguían manteniendo medallas de mérito a su profesionalidad, siendo público y notorio su participación en la defensa de la dictadura franquista, mediante la represión política, y la práctica continuada de métodos de tortura. Cuando estos casos se activan para su su clarificación, el “Estado profundo” actúa y desactiva, de la manera que cada caso aconseje, todas los posibles caminos para la inculpación de estas personas. Casos paradigmáticos de estos procesos los podemos encontrar en personas como “Billi el Niño” que en 1977, un gobierno democrático le destinó en la Brigada Central de información, teniendo ya conocimiento de cuales eran sus métodos de actuación en relación con la tortura. Melitón Manzanas conocido por sus prácticas salvajes de tortura, y denunciado por personas nada sospechosas de querer destruir España, es otra persona a la que el Estado profundo le ampara, en 2001 le concedieron la Gran Cruz de reconocimiento Civil, pagando a su familia indemizaciones millonarias por haber sido víctima del “terrorismo”.

Martín Villa, proveniente de la jerarquía de mando franquista, junto a Manuel Fraga y el capitán Quintana, son considerados los responsables de la masacre de 3 de marzo en Vitoria, por las evidencias que hay al respecto. Para esclarecer estas muertes de obreros, la causa abierta contra ►

La Reforma no fue un pacto entre iguales ni fue una ruptura con el Estado anterior. Fue una especie de *aggiornamiento* favorable a unas élites políticas y económicas que necesitaban escenificar un cambio.

Martín Villa, tiene que ser llevada a Argentina para que se investigue, ya que en España no hay ningún tribunal de justicia que quiera asumir este caso. Los protege el "Estado profundo". Se podrían exponer más nombres y más casos, pero la "democracia incompleta" (término que utiliza Emanuel Rodríguez López en su libro "por qué fracasó la democracia en España") es muy aplicada en eso de cuidar a su gente, y en muchas ocasiones lo que hace es intentar castigar al mensajero. Esta "democracia incompleta" es así, sigue teniendo un profundo olor a naftalina rancia (es el olor político del franquismo), en muchos uniformes, muchas togas y muchos medios de comunicación. Sin miedo a equivocarnos, se puede decir que el "Estado dentro del Estado" asumió la responsabilidad de que el franquismo hiciera el tránsito a la democracia sin tener que rendir ningún tipo de cuentas.

Estos espacios de poder y de influencia son caldo de cultivo para acoger en su seno lo que se denomina el "Estado dentro del Estado". Cada época histórica ofrece sus propias formas de "Estado paralelo", según las necesidades. Si queremos analizar donde se encuentra este "Estado dentro del Estado" en el actual sistema español, debemos buscar en la época franquista para encontrar datos sólidos que nos permitan conclusiones fiables. En el sistema político español el "Estado paralelo" tiene un rasgo ideológico que lo identifica y lo conecta con otras etapas políticas de la historia de España: la Restauración.

El término Restauración aplicado a la política tiene un significado muy claro: modificar el estado de las cosas para volver a una situación anterior. Dicho de otra manera, en el Estado español este término ha servido de escenario para el establecimiento de un régimen político que había sido sustituido por otro, girando casi siempre sobre la figura de un monarca. *También fue la Restauración el gran referente de los políticos del reformismo franquista* (Emanuel Rodriguez López). Con la idea central de la Restauración como guía principal de la Transición y de la Reforma, solo quedaba darle contenido político a todo el entramado político-institucional con una Constitución que marcará todo el proceso para formalizar la Democracia en el Estado español. A todo este modelo se le domina "régimen del 78".

La Reforma no fue un pacto entre iguales ni fue una ruptura con el Estado anterior. Fue una especie de *aggiornamiento* favorable a unas élites políticas y económicas que necesitaban escenificar un cambio. En realidad fue una apertura del modelo de Estado franquista para incorporar a las izquierdas como legitimadoras del proceso de *Reforma democrática*. El régimen y sus élites tenía muy claro qué querían de la izquierda española, que actuara como un ente subalterno que sirviera para disciplinar a la mayoría social en la reestructuración del capitalismo en el Estado español.

La fórmula de la Restauración sitúa a España en el modelo social y político que le ha caracterizado en los últimos siglos. Un modelo que siempre mira para atrás, y siempre se ha situado en el conservadurismo más rancio. La Restauración en la persona de Juan Carlos I, enlaza con la España de siempre; y la Transición, engendrando la Reforma democrática, enlaza con el franquismo. Aquí tiene cabida la frase con la que algunos historiadores tratan de explicar la personalidad política de España: "España se copia a si misma".

En este “copiarse a si misma”, el “Estado profundo” encuentra su encaje, y a cada etapa histórica corresponden directorios de mando diversos. Dos momentos históricos marcan el ADN del “Estado paralelo” en la etapa actual: el levantamiento franquista contra la República y la Transición española a la democracia. El deseo del “Estado profundo” es naturalizar el franquismo en la democracia. Teniendo en el Estado español esta construcción conspiranoica tres columnas principales: la Guardia Civil, los medios de comunicación y el Poder judicial.

**La Guardia Civil.** Es una parte importante del “Estado dentro del Estado”, no quiere intromisiones ni que le pongan impedimentos en sus decisiones y actuaciones. En los últimos años y con respecto a Euskal Herria, con su comportamiento se ha mostrado totalmente en contra del proceso de paz, convivencia y resolución, acordado en su tiempo entre el PSOE, que estaba en el gobierno, y la organización armada ETA. Este cuerpo militar tiene su propio funcionamiento autónomo, tanto, que tiene un régimen especial para la vida cotidiana, que abarca, entre otras cosas, servicios sociales y sistema de vivienda diferenciados del resto de la población. Esto produce un recreación continua de su constante endogamia en el espacio de actitudes y toma de decisiones, debido a la ideología que cultivan en los cuarteles.

La Guardia Civil se ganó la confianza de Franco debido a su implicación severa en la represión post-contienda. Una vez finalizada la guerra civil, fue la guardia Civil quien asumió la responsabilidad de llevar a cabo una represión brutal, con el objetivo de disciplinar a la ciudadanía en aras de una aceptación sin reproches del régimen franquista y de los “Principios del Movimiento”. Franco, unos años más tarde, otorgó a la Guardia Civil la custodia del que nombró príncipe de España para la sucesión. La Guardia Civil era el cuerpo militar mejor considerado por Franco debido a la fidelidad que mostraba hacia su persona, y a las ideas de la dictadura.

La transición de la Guardia Civil franquista, a la Guardia Civil de la democracia tiene un nombre clave, Andrés Casinello. Esta persona dirigía los servicios secretos durante la Transición y el Servicio de Información de la Guardia Civil durante el 23-F. Desde estos puestos de mando en los servicios secretos, marca las lineas principales sobre el comportamiento y actuación del cuerpo militar que dirigía, en la democracia española. Toda su aportación a la época en clave política y militar tiene dos contenidos principales: defensa del espíritu de la Transición y la unidad de España. Estos dos procesos obedecen a una estructura mental y política única: servir de corsé ante la realidad de un estado plurinacional que se quería ocultar.



Hay una anécdota que retrata al personaje, y deja evidencias de su arrogancia y de lo protegido e impune que se ha sentido siempre. En un entrevista que le realizan en 1984, ante la pregunta de si era jefe de los GAL, como apuntaban muchos, contestó al periodista: "Fíjate si fuera verdad y tú lo hubieras descubierto. Tu vida valdría sólo dos pesetas". Desde 2007 se crea una asociación cuyo nombre es *Asociación para la defensa de la Transición*, de la que Andrés Casinello fue su presidente. Muchos de los componentes del "Estado profundo" tienen en este tipo de asociaciones su lugar para ocuparse de los últimos años de su vida, apareciendo ante la sociedad como un *dolce far niente*. Este sistema tiene un gran parecido al que se utiliza en el consumo de los mejillones. Después de engordar, se les saca de sus aguas para que destilen las impurezas y puedan ser consumidos. El lugar donde estos personajes destilan sus impurezas es en este tipo de asociaciones. El *establishment* necesita hacer digerible para la sociedad española, lo que tanto tiempo se ha nutrido de las cloacas del Estado.

La Guardia Civil siempre ha puesto obstáculos a la hora de encontrar una solución al conflicto vasco. En todos los procesos de negociación, e incluso en los de toma de contacto, este cuerpo militar ha solido dejar clara sus intenciones y opinión al respecto. Es una especie de autoinvitado que desea siempre terminar siendo el anfitrión del proceso. Para hacerse notar nunca ha escatimado detenciones, con sus consiguientes métodos intimidatorios, de personas implicadas, de una manera u otra, en el conflicto que se quería solucionar. Es un exponente claro de ser componente del "Estado dentro del Estado" y se enorgullece de serlo. No lo oculta. Ahí tenemos como muestra todas las detenciones que ha realizado desde que ETA anunciara su intención de desaparecer de la escena política en la Conferencia de Aiete. Hace todavía poco, el sindicato AUGC de este cuerpo, criticaba la falta de democracia interna afirmando que "la Guardia Civil es un Estado autoritario, dentro de un Estado de derecho".

Hay una anécdota que ilustra este hecho, se produjo en la época en la que se le estaba dando forma a la Transición. Se había llegado a un acuerdo sobre las Autonomías y se establece una reunión para dar testimonio de la situación. Después de presentar el mapa autonómico, diecisiete autonomías que regirán en adelante, el general Casinello pide la palabra y plantea que no hay diecisiete autonomías, sino dieciocho, la decimoctava la de la Guardia Civil. Nadie de los allí presentes se atrevió a contestarle.

Varios años después del anuncio de ETA de abandonar la lucha armada, Valentín Díaz teniente coronel jefe de la UCE-1 de la Guardia Civil, realiza al diario el País, unas declaraciones, que nos dan una idea de su posición obstruccionista ante el proceso de paz que estaba en marcha en Euskal Herria:

"Contra ETA no hemos aflojado. La última fase de una guerra es la persecución del enemigo y la explotación del éxito. (...) hay que seguir investigando y revisando el pasado. Queda mucho por hacer. Pero nos sobra tiempo tenemos 170 años".

**Los medios de comunicación.** Imprescindible su participación en el "Estado dentro del Estado". Los medios de comunicación tienen una gran responsabilidad en una cuestión principal: crear opinión pública para que pudiese llevarse a cabo la Transición de la dictadura a la democracia. Es decir, se posicionaron por no depurar responsabilidades por todas las salvajadas realizadas por el aparato franquista: levantamiento militar contra la República, desapariciones, torturas, juicios sumarísimos, ejecuciones, represión generalizada... La postura de los principales medios de comunicación españoles fue defender el pacto con los criminales, con la dictadura, protegiendo de esta manera a los delincuentes franquistas. Los medios de comunicación adoptan la posición esa, de "el fin justifica los medios". Con esta postura, los medios de comunicación dan su visto bueno para naturalizar el franquismo, y otorgar, de esta manera, sello democrático al neofranquismo.

Hoy en día, el neofranquismo está presente en las direcciones y accionariado de los grandes medios de comunicación, de los grandes bancos, de las corporaciones crediticias...están en el puesto de mando. Con la Transición, el sistema que se crea trae consigo el "octavo pasajero", como en la saga Alliens, para perpetuar la "especie". En nuestro caso, especie política, que tiene sus prácticas enraizadas en las de la dictadura franquista. Los medios de comunicación fueron imprescindibles a la hora de llevar a cavo esta construcción. Desde una posición aparente de defensa de la democracia, naturalizan y fortalecen las posiciones fascistas, neofranquistas.

En el Estado español, los medios de comunicación más importantes y que más ayudas económicas públicas reciben, han establecido un modelo de información de estilo paranoide. Las historias más histriónicas tienen cabida en sus libros de estilo. No son informantes, son *hooligans ideológicos* de la "España invertebrada" que echan de menos tiempos pasados...a los que muchos y muchas quisieran volver.

Cuando se produce un hecho luctuoso en el Estado español, en lugar de asociarlo a la dimensión humana de los individuos, insertados en una sociedad tipo con todos sus factores psicológicos, sociológicos, culturales y económicos en juego, se intenta contextualizarlo en un espacio moral interesado, donde los medios de comunicación más influyentes expresan su ideología. Se informa con estilo paranoide, agitando el miedo y creando un estado emocional tan alterado que en algunos momentos cabría dudar de ►

Se han aplicado a fondo en los papeles que les han asignado, y han conseguido hacerse un hueco en el espacio de “cine de terror”. Porque terror, y no justicia, han traído a muchos hogares vascos.

la gobernabilidad del país. Estos medios de comunicación se encargan de soliviantar las iras de la sociedad e intentan crear una asociación entre delito y debilidad de la justicia. El objetivo último es abrir un espacio por donde influir en los poderes del Estado y marcar las pautas que se deben seguir a la hora de legislar en el ámbito penal. ¡Y lo consiguen! Su influencia produce consecuencias en la forma de legislar y también en la manera de administrar la justicia. La mayoría representan intereses privados; intervienen en lo público desde lo privado, y no tienen control ni “contrapesos”. Esto hace que su poder sea grande, pues utilizando a la opinión pública como ariete, tienen la capacidad de dar y quitar votos.

Como consecuencia de este proceder se va estableciendo un estilo de hacer las cosas que se perfila hacia un espacio opaco y autoritario donde el “populismo punitivo” ocupa el lugar de la racionalidad democrática. Una racionalidad que tiene como uno de sus objetivos evitar que la justicia se convierta en un órgano vengativo.

**El Poder judicial.** Parece ser que se está preparando un nuevo Código Penal para el Estado español. La asiduidad con la que se producen estos cambios en un espacio de tiempo tan reducido delata un problema en el funcionamiento del Estado. Algunos entendidos en la materia, lo achacan a una falta de madurez política y social. Pero, aun estando de acuerdo con esta opinión, el problema es mucho más profundo y tiene que ver más con una concepción ideológica de interpretar la solución de los problemas, que con un proceso metodológico de adecuación de la pena al delito, o de las situaciones sociales al delito.

La aparente necesidad de cambiar el Código Penal en espacios tan cortos de tiempo no guarda relación entre el aumento y gravedad de los delitos y la necesidad de corregirlos de manera más rigurosa. Estamos en cifra récord de población reclusa con respecto a la tasa europea. En el Estado español se producen un 20% menos delitos que la media europea, en cambio tiene las penas más duras y desproporcionadas, y como consecuencia, el mayor numero de presos y presas. Los constantes cambios que se realizan en el Código Penal para endurecer las penas (tanto de cariz político, como comunes), no es debido a una urgencia por el aumento de los delitos y su gravedad, sino que se sustancia en una manera de informar, de gobernar, de legislar, y de juzgar, impregnadas de una demagogia populista reaccionaria.

El espacio judicial español es una de las asignaturas pendientes del sistema. Complicada tarea para un poder que transita por la vida social española con vitola de *vedette*. El TOP dejó una escuela de cartas marcadas, y todavía no han cambiado de baraja. De los tres poderes de los que se dota los sistemas democráticos, el judicial es el menos

expuesto, ya que el ejecutivo y el legislativo parten de un proceso electoral. En Europa desconfían de la íntima relación entre la judicatura y las fuerzas políticas, lo que hace dudar, y mucho, de su pretendida imparcialidad. En el Estado español muy poca gente se cree lo de “la justicia es igual para todos”.

Los vascos y vascas sufrimos a ciertos jueces españoles. Muchos y muchas de ellas han llegado al estrellato utilizando recursos varios. Uno de esos recursos ha sido convertirse en el *látigo de doma* de la Izquierda Independentista vasca. Utilizando el látigo a conveniencia, han ido apareciendo en escena las estrellas invitadas que el “Estado profundo” decidía poner en cartelera en cada momento. Sus actuaciones no han dejado a nadie indiferente. Se han aplicado a fondo en los papeles que les han asignado, y han conseguido hacerse un hueco en el espacio de “cine de terror”. Porque terror, y no justicia, han traído a muchos hogares vascos. Mirar para otro lado con la tortura, y las imputaciones por necesidades del “guion”, han sido sus especialidades. Un guion que casi siempre estaba escrito por una mano verde. El “octavo pasajero” haciendo de guionista. Sin poner nombres, todos y todas sabemos a quienes nos estamos refiriendo.

El tratamiento que el independentismo vasco ha tenido por parte de la judicatura española ha sido de desprecio, de imposición, de soberbia y de venganza. El independentismo vasco no se puede sentir vinculado con el Estado después de sufrir este trato. Se siente maltratado, y la vinculación a la que nos obligan es agresiva, es por la fuerza. En este espacio concreto, por la fuerza de las imputaciones fuera de tono y de tiempo; por la falta de imparcialidad; por ser desproporcionada; por estar establecida en el espacio de la disputa ideológica en lugar de la racionalidad jurídica; por no tener en cuenta el nuevo tiempo que se vive en Euskal Herria y retrasar lo más posible la salida de los presos utilizando la excepcionalidad de la ley 07/2003, incluso de manera retorcida, para evitar que los recursos jurídicos de los y las presas prosperen.

En el Estado español es necesaria una verdadera transición a la democracia que suponga una ruptura real con las maneras de hacer política heredadas del franquismo que siguen vigentes. En este contexto de transformación sería exigible un Código Penal que no utilizara la venganza y no amparase bajo su aspecto democrático lo que sólo son coqueteos fascistas. Hay que exigir un derecho penal democrático que, entre otras cosas, facilite “adelgazar” las cárceles proponiendo, en muchos casos, otros modelos de resarcimiento social ante el delito.

A pesar de todo esto, el “Estado dentro del Estado” seguirá funcionando, porque la guarida donde se refugia, se llama “régimen del 78”. Al no disponer, de momento, fuerza suficiente para neutralizarlo, no nos queda más remedio que recurrir al sigilo continuamente. Como decía Quevedo, “donde hay poca justicia es un peligro tener razón”. ●



# Epaitegietatik eta ebazpen judizialak

MARTXOAK 8

## Joseba Fernandez absolbitua

Audientzia Nazionalak Joseba Fernandez Aspurz preso iruindarra absolbitu du 2008ko kausa batengatik. Epaiketan bertan, fiskaltzak akusazioa erretiratu du proba faltagatik.

MARTXOAK 9, 10 ETA 15

## Iparragirre berriro Audientzia Nazionalean

Marixol Iparragirrek beste hiru epaiketa izan ditu Audientzia Nazionalean. Preso politiko eskoriatzarrak estatu espainolak torturak isilarazten dituela salatu zuen eta torturen biktimentzako prozesu erreparatzailea eskatu zuen, ez errepikatzeko berme bezala. Epaileak bere interbentzioa moztu zuen. Martxoaren 15eko epaiketan estatu espainola seinalatu zuen eta 1936ko gerra ostean egin bezala orain ere kontakizun faltsua ezarri ote nahi duen, «gaizto eta onen» artekoa alegia. Martxoaren 9ko epaiketaren ebazpena apirilaren 28an atera da, 39 urteko espetxe zigorra ezarriz. Martxoaren 10ekoaren epaia martxoaren 17an atera da, 61 urteko espetxealdira zigortuz, eta martxoaren 15ekoarena apirilaren 6an atera da, Iparragirre absolbituz.



MARTXOAK 16

## Urriaren 12ko auzibidea artxibatua

Nafarroako 12 Sortukidek Espainiako Auzitegi Nazionalean deklaratu behar izan zuten otsailean, urriaren 12an Iruñean antolaturiko ekintza sinbolikoan parte hartzeagatik. Koroaren aurkako delituak leporatuta deklaratu zuten, ikertu gisa, baina abiaturiko auzibidea artxibatu egin duenez ez dute epaiketarik izango azkenean.



MARTXOAK 19

## Jon Rubenach zigortua

Audientzia Nazionalak 1008 urteko espetxe zigorra ezarri dio Jon Rubenach preso politiko iruindarrari, 2001eko ekintza batengatik.

MARTXOAK 21

## Gorka Palacios zigortua

Audientzia Nazionalak Gorka Palacios preso politiko durangarrari 6 urteko espetxe zigorra ezarri dio 1997ko egitate batzuengatik.

MARTXOAK 22

## Iurgi zigortua eta Ugaitz absolbitua

Inaxio Uriaren hilketan parte hartzea egotzita Iurgi Garitagoitia eta Ugaitz Errazkin epaitu zituzten otsailean. Audientzia Nazionalak Garitagoitia 44 urtera zigortu du eta Errazkin absolbitu.



espetxera eta Jon Troitiño eta Harriet Iragi Logroñokora eramango dituztela.

MARTXOAK 13
**Adiorik ez Fran**
Fran Balda militante sutsua Etxarri--Aranaztik etxera bueltan zen, Arbizurako bidean, kotxe batek harrapatu zuenean. Presoen eskubideak aldarrikapentean ohiko aurpegia eta militante lanetan langile sutsua zen. Amnistiaren Aldeko Batzordean, Egin Dezagun Bidean, Herriran, Euskal memorian, Kalera-Kaleran eta egungo Saren beti borrokatu zuen euskal preso politikoen alde. Eskerrik asko, Fran, eman duzun guztiagatik.

MARTXOAK 18




**Mugimenduen iragarpena**
Espetxe Instituzioek iragarri dute Iñaki Garces Basauriko espetxera ekarriko dutela eta Jon Olarra, Ainhoa Mujika eta Arkaitz Goikoetxea Logroñokora eta Mikel Izpura Zuerakora eramango dituztela.

MARTXOAK 18
**Lekualdatzeak gauzatuta**
Juankar Iglesias Chouza Villenako espetxetik Dueñaseko espetxera, Iker Lima Sagarna Huelvakotik Leonekora, Iñigo Guridi Lasa Jaenekotik Leonekora, Javi Gallaga Ruiz Cordobakotik Darocakora, Igor Portu Juanena Cordobakotik Darocakora eta Xabier Makazaga Azurmendi eta Gorka Martinez Ahedo A Lamakotik El Duesokora lekualdatu dituzte.

MARTXOAK 18
**Positiboa Covid 19-an**
Mureteko espetxean (425 km) giltzapean 31 urte bete dituen Ion Kepa Parot preso politiko baionarrak positibo eman du Covid 19an eta bere berehalako askatasuna eskatu du Etxeratek.

MARTXOAK 19
**Ainhoa Garcia Villabonan**
Ainhoa Garcia Montero preso politiko hernaniarrak Topaseko espetxetik atera eta Villabonakora heldu da.

MARTXOAK 23
**Deportazioa Argitara**
Susana Pasinello ikerlari katalanak “Los deportados de ETA. Los olvidados del conflicto” (Txertoa) lana argitaratu du. Estatu espainolak 80. hamarkadan Hego Amerikara eta Afrikara deportatu zituen 70 bat pertsona horien errealitatea biltzen du bertan.



MARTXOAK 25
**Agur Picassent, Villena eta Albocasser**
Espetxe Instituzioek iragarri dute Idoia Mujika, Jon Gonzalez eta Jose María Dorronsoro Iruñeako espetxera ekarriko dituztela. Bestetik, José Lorenzo Ayestaran eta Oscar Zelarain Soriako espetxera eta Unai Parot Leonekora eramango dituztela jakinarazi dute ere.




MARTXOAK 26
**Lekualdatze gauzatuak**
Aitor Agirrebarrena Beldarrain lizartzarra (Puerto III-tik) Villabonako espetxera, Jose Mari Novoa gasteiztarra (Murciatik) Leonekora, Jon Bienzobas Arretxe galdakoztarra (Puerto III-tik) Dueñasekora eta Josu Ordoñez Fernandez donostiarra (Puerto I-tik) Topasekora lekualdatu dituzte.

MARTXOAK 27
**Euskal Herriratzeak eta hurbilketa gauzatuak**
Gorka Loran Lafourcade preso politiko hernaniarra (Dueñasetik), Sergio Polo Escobes sopeloztarra (Herrera de la Manchatik), Patxi Markes Zelaia berangotarra, (Castello II-tik), Gorka Vidal Alvaro zaratamoztarra (Logroñotik), Roberto Lebrero Panizo gasteiztarra (Burgosetik) eta Iñaki Armendariz Izagirre iruindarra (Burgosetik) Zaballako espetxera eta Jurdan Martitegi Lizaso durangarra (Soto del Realetik) Martutenera ekarri dituzte. Bestetik, Francisco Jose Ramada Estevez beratarra Iruñeko espetxetik Martutenera lekualdatu dute. Azkenik, Iñigo Zapirain Romano bilbotarra (Aranjuezetik) El Duesoko espetxera eraman dute.

MARTXOAK 31
**Agur Huelva**
Espetxe Instituzioek iragarri dute Angel Lopez Anta Zaballara hurbilduko dutela. Horrez gain, Xabier Garcia eta Irantzu Gallastegi Estremerara, eta Aitor Olaizola eta Xabier Zabalo Logroñora eramango dituztela jakinarazi dute.




MARTXOAK 31
**Lekualdatze gauzatuak**
Diego Ugarte Lopez de Arkaute preso politiko gasteiztarra (Granadatik) eta Fernando Garcia Jodra bilbotarra (Huelvatik) Leoneko espetxera, Mattin Sarasola Larzabal lesakarra

eta Beñat Aginagalde Ugartemendia hernaniarra (Jaenetik) Dueñasekora, Gurutz Agirresarobe Pagola hernaniarra (Sevillatik) Logroñokora, Ana Belen Egues Gurrutxaga elduaiendarra (Cordobakotik) Villabonakora eta Eneko Goieaskoetxea Arronategi gernikarra (A Lamatik) El Duesokora eraman dituzte.

APIRILAK 9
### Euskal Herriratze eta lekualdatze gauzatuak
Ainhoa Barbarin Iurrebaso preso politiko urretxuarra (Picassentetik), Unai López de Okariz López gasteiztarra (Darocatik) eta Zigor Orbe Sevillano basauriarra (Puerto III-tik) Zaballako espetxera, Juan Carlos Subijana Izquierdo gasteiztarra (Leonetik) Basaurikora eta Josune Arriaga Martínez iruindarra (Topasetik) Iruñeakora hurbildu dituzte. Bestetik, Iñaki Etxeberria Martín iruindarra (Topasetik) El Duesoko espetxera, Jon Mirena San Pedro Blanco bilbotarra (Herrera de la Manchatik) Dueñasekora, Arkaitz Goikoetxea Basabe algortarra (Villenatik) Logroñokora eta Gorka Palacios Aldai durangarra (Murcia II-tik) Estremerakora lekualdatu dituzte.

APIRILAK 9
### Mugimenduen iragarpena
Espetxe Instituzioek iragarri dute Iñigo Vallejo El Duesoko espetxera, Garikoitz Etxeberria Dueñasera eta Fernando Elejalde Leonera eramango dituztela.

APIRILAK 12
### Lekualdatze gauzatuak
Ibai Beobide Arza preso politiko bilbotarra (Puerto II-tik) Burgoseko espetxera, Juan Ramon Karasatorre Ardaz etxarriarra (Albocasseretik) eta Asier Badiola Lasarte ondarroarra (Valencia III-tik) El Duesokora, Ion Troitiño Cira donostiarra (Murcia II-tik) eta Jon Olarra Guridi donostiarra (Granadatik) Logroñoko espetxera lekualdatu dituzte.

APIRILAK 14
### Hurrengo urratsa, kaleratzea
Preso Politikoen Nazioarteko Egunaren harira Sortuko Rufi Etxeberria eta Oihana Garmendia elkarrizketatu ditu Naiz irratiko Ion Telleriak. Fase bat gainditzear dagoen honetan hurrengoari begira jarri da Sortu euskal preso politikoen alorrean. Hizlarien ustez, azken urteotan eginiko hurbiltze, Euskal Herriratze, gradu aldaketek eta bakartzearen akaberak “humanizatu” egin dute salbuespenezko espetxe politika eta praktika kriminala eta, orain, kartzelan “betea duten denboraren araberako eskubidea” lortzea egokitzen zaie euskal presoei. ¼, ½, edota ¾ ak beteta dituzten 168 presoei “kalea zapaltzea” dagokie.



APIRILAK 16
### Agur Galizia
Espetxe Instituzioek iragarri dute Igor Martinez de Osaba eta Asier Bengoa (azken hau 3º graduan sailkatuta) Zaballara, Ugaitz Perez Basaurira eta Garikoitz Arruarte Iruñeara hurbilduko dituztela. Horrez gain, Itxaso Zaldua Villabonara eta Goio Eskudero Dueñasera eramango dituztela jakinarazi dute.



APIRILAK 17
### EPPKren agiria
EPPK-k agiria kaleratu du Preso Politikoen Nazioarteko Egunaren harira. Frantziak eta Espainiak 2018tik egindako urratsak “kontuan hartu” arren, etxeratzeko urrats gehiago eskatu du.

APIRILAK 17
### Euskal Herriratze eta lekualdatze gauzatuak
Angel Lopez Anta preso politiko ortuellarra (Leonetik) Zaballara, Iñaki Garcés Beitia otxandioarra (Zueratik) Basaurira eta Mikel San Argimiro Isasa donostiarra eta Aitor Esnaola Dorronsoro legorretarra (Soriatik) Martuteneko espetxera hurbildu dituzte. Bestetik, Agus Almaraz Larrañaga bilbotarra (Estremeratik) eta Mikel Izpura Garcia iruindarra (Murcia II-tik) Zuerara, Unai Parot Navarro baionarra (Puerto III-tik) Leonera, Harriet Iragi Gurrutxaga bilbotarra (Albocasseretik), Bittor Franco Martínez barakaldoarra (Estremeratik) eta Javier Zabalo Beitia zumarragarra (Valladolidetik) Logroñora eta Raul Fuentes Villota bilbotarra (Soto del Realetik) El Duesoko espetxera lekualdatu dituzte.

APIRILAK 18
### Beste istripu bat
Etxeratek jakinarazi duenez, Iker Lima preso politiko galdakoztarraren lagun batek kotxe istripua izan du Leoneko espetxetik (370 km) etxerako bidean bueltan zetorrela.



APIRILAK 20
### Gauzatutako espetxe mugimenduak
Jose Maria Dorronsoro preso politiko donostiarra Iruñeako espetxera hurbildu dute. Bestetik, Irantzu Gallastegi Sodupe berangoztarra eta Xabier Garcia Gaztelu galdakoztarra Huelvako espetxetik Estremerako espetxera lekualdatu dituzte.

APIRILAK 23

## Agur Granada

Espetxe Instituzioek iragarri dute Mikel Arrieta Martutenera eta Iñaki Bilbao Gaubeka Basaurira hurbilduko dituztela. Bestetik, Unai Bilbao Darocara eta Imanol Miner Dueñasera lekualdatuko dituztela jakinarazi dute.




APIRILAK 24

## Euskal Herrira eta periferikoetara lekualdatzeak

Asier Karrera Arenzana preso politiko etxarriarra Dueñasetik Martutenera eta Jon Gonzalez Gonzalez santurtziarra Picassentetik Iruñeko espetxera hurbildu dituzte. Bestetik, Aitor Olaizola Baseta irundarra Dueñasetik Logroñora, Oskar Zelarain Ortiz villabonarra Albocasserretik Soriara, Íñigo Vallejo Franco basauriarra Dueñasetik El Duesora eta Gotzon Aranburu Sudupe azpeitiarra Villenatik Dueñasera lekualdatu dituzte.

APIRILAK 30

## Euskal Herriratze eta lekualdatze gauzatuak

Idoia Mendizabal Mujika preso politiko ordiziarra Picassenteko espetxetik Iruñeko espetxera hurbildu dute. Fernando Elejalde Tapia donostiarra Puerto I espetxetik Leoneko espetxera, Lorenzo Aiestaran Legorburu lezoarra Villenatik Soriara, Bea Etxebarria bilbotarra Aranjuezetik El Duesora eta Juan Carlos Besance Zugasti villabonarra Huelvatik eta Garikoitz Etxeberria Goikoetxea lizartzarra Sevillatik Dueñasera lekualdatu dituzte.

APIRILAK 30

## Agur Foncalent

Espetxe Instituzioek iragarri dute Aurken Sola Iruñeako kartzelara eta Irkus Badillo Basaurikora ekarriko dituztela. Bestetik, Mikel San Sebastian Soriakora eramango dutela jakinarazi dute ere.



MAIATZAK 1

## Basauri, Zaballa, Iruñea eta EHko ingurura

Asier Bengoa Lopez de Armentia preso politiko gasteiztarra Darocako espetxetik Zaballako espetxera, Ugaitz Perez Zorriketa galdakoztarra Logroñotik Basaurira eta Mikel Otegi Unanue itsasondoarra Valdemorotik Iruñeara hurbildu dituzte. Ainhoa Mujika Goñi preso politiko donostiarra Granadatik Logroñora lekualdatu dute.

MAIATZAK 6

## Mugimendu gauzatuak

Irkus Badillo Borde preso politiko ugaoarra Alacant I-eko espetxetik Basauriko espetxera etorri da eta Gregorio Eskudero Balerdi oriotarra Teixeirotik Dueñasera lekualdatu dute.

MAIATZAK 7

## Mugimenduen iragarpena

Espetxe Instituzioek Karlos Apeztegia Iruñeako espetxetik Martutenekora aldatuko dutela eta Lexuri Gallastegi Almeriatik Zuerara lekualdatuko dutela iragarri dute. Horrez gain, Xabier Perezi eta Joseba Segurolari 100.2 artikulua aplikatzea erabaki dute (bigarren graduan daude biak).

MAIATZAK 11

## Lekualdatze gauzatuak

Iñaki Bilbao Gaubeka preso politiko urduliztarra Zuerako espetxetik Basauriko espetxera ekarri dute. Julen Atxurra Egurrola lekeitiarra Aranjuezetik El Duesora eta Itxaso Zaldua Iriberri hernaniarra Topasetik Villabonara lekualdatu dituzte.

MAIATZAK 15

## Euskal Herriratzeak eta lekualdaketa

Igor Martinez de Osaba Arregi preso politiko gasteiztarra Zuerako espetxetik Zaballara eta Mikel Arrieta Llopis errenteriarra Soriatik Martutenera ekarri dituzte. Bestetik, Portugaleteko Unai Bilbao Solaetxe Granadatik Darocara lekualdatu dute.

MAIATZAK 21

## Sei lekualdaketeen iragarpena

Villabonako espetxetik Zaballako espetxera Iratxe Yanez Ortiz de Barron gerturatuko dute eta beste lau preso lekualdatuko dituzte, hain zuzen ere: Andoni Goikoetxea Dueñaseko espetxetik El Duesokora, Juan Luis Agirre Lete Zuerako espetxetik Soriakorara eta Asier Arzalluz eta Iker Olabarrieta Sevillako espetxetik Logroñokora. Bestealdetik, EPPK kide ez den eta prebentziozko espetxealdian dagoen Valentina Morisoli Madrilgo Alcala Mecotik Zaballara ekarriko dute.

MAIATZAK 22

## Lau preso hurbilduak

Mikel Sansebastian Gaztelumendi preso lesakarra Murcia II espetxetik Soriako espetxera lekualdatu dute. Bestealdetik, Garikoitz Arruarte Santacruz Soriako espetxetik Iruñeko espetxera eta Aurken Sola Campillo, Burgosetik Iruñera ekarri dituzte eta, azkenean, Karlos Apeztegia Jaka Iruñeko espetxetik Martutenera egokitu dute.

MAITZAK 27

## Imanol Miner Dueñasen

Granadako espetxetik Valdemorokora eta bi aste transitoan egon ostean, azkenean, Imanol Miner villanueva Dueñaseko espetxera heldu zen.

MAITZAK 28

## Bi lekualdatzeen iragarpena

Bi lekualdatze iragarri ditu Espainiako Espetxe Zuzendaritzak: Jon Rubenach eta Asier Borrero Kantabriako Duesora gerturatuko dituzte. Biekin jada 25 euskal preso izango da kartzela honetan.

Etxerat

etxean nahi ditugu

# UDAKO MATERIALA



KAMISETAK 14,95€TIK HASITA



MUSUKOAK 5,95€



POLOAK 15,95€TIK HASITA



SUDADERAK 29,95€TIK HASITA

EGIN EZAZU ZURE EROSKETA HELBIDE HONETAN ETA ETXERA BIDALIKO DIZUGU

WWW.SERIGRAFIA.EUS/SHOP/ETXERAT

EDO ATERA ARGAZKIA QR KODEARI ETA DENDARA ERAMANGO ZAITU



Euskal Preso eta Iheslari Politikoen Senide eta Lagunen Elkartea

# Presoak kalean

MARTXOAK 12

**Oihan Barandalla aske**

Oihan Barandalla Goñi euskal preso etxarriarra 2007. urtean atxilotu zuten estatu frantsesean. Zigorra amaitu ostean frantziar estatuko lurraldetik kanporatua izan da eta estatu espainolean aske gelditu da.

MARTXOAK 13

**Kepa Legina kalean**

46 urte etxetik kanpo eta 21 urte espetxeraturik egon ostean, Kepa Legina Aurre preso politiko bilbotarra aske gelditu da, zigor osoa beteta 1. graduan.

APIRILAK 5

**Juan Mari Etxebarri aske**

Juan Mari Etxabarri Garro preso politiko iruindarra aske geratu da. Sevilla II-ko espetxetik atera da gaur goizean 23 urtez preso egon ondoren.

APIRILAK 20

**Azkarate eta Sarrionaindia etxean**

1987an egin zuen ihes  Agustin Azkaratek, tortura latzak eta urtebeteko kartzelaldia pasa ostean, eta 1985ean Joseba Sarrionaindiak, Martuteneko espetxetik hanka eginda. Hiru hamarkada baino gehiago pasa ostean, berriz ere Euskal Herrian daude bi iheslari politikoak.

APIRILAK 25

**Iñaki Arakama libre**

Iñaki Arakama Mendia preso politiko gasteiztarra aske gelditu da. Aljergo negoziazioen ostean, Santo Domingon deportatu zuten. Dominikar Errepublikan 8 urteko deportazioaren ostean espainiaratu eta espetxeratu egin zuten, bertan 24 urtez preso egon delarik.

APIRILAK 27

**Ander Mujika kalean**

Ander Mujika Andonegi preso politiko donostiarra aske geratu da, Mont de Marsan espetxetik espainaratu ondoren eta hamahiru urteko espetxealdia beteta.

MAIATZAK 1

**Lorentxa Beyrie aske**

Lorentxa Beyrie preso politiko kanboarrak atzean utzi du espetxea, 20 urte preso pasa ondoren.

# Preso Politikoen Nazioarteko Egunean EPPKren agiria euskal jendarteari

Preso Politikoen Nazioarteko Egun honetan, espainiar eta frantziar Estatuetako espetxeetatik agurrik beroena helarazi nahi diogu euskal jendarteari.

Gure agurra helarazi nahi diegu, aldi berean, munduko edozein herritan, edozein lekutan, ideia politikoengatik eta askatasunaren alde borrokatzeagatik zigortuak diren eta preso dauden pertsona guztiei. Biharko mundua Herri bakoitzarentzat eta Herri guztientzat atseginago, justuago eta askeago izateko nahiak eta hori lortzeko egiten dugun ahaleginak batzen baikaitu distantzia fisikoak banandutako preso politiko guztiok.

Atzera utzi dugun urtebete honetan ikusi dugu, euskal preso politikook gure artean gehiegitan ikusi dugun moduan, espetxeak bere alderik zaurtzaileenean presoon osasuna eta bizia lapurtzen dituela. Alde horretatik, ez ditugu aipatu gabe utzi nahi iazko irailaren 4an Igor Gonzalez Sola hil zela Martutenen, eta urriaren 22a Asier Aginako Durangon, espetxean larriki gaixotu ondoren kaleratuta.

Murrizketak areagotuz eta eskubideak mugatuz erantzuten du espetxeak edozein arazoren aurrean, eta urtebete honetako pandemia denboran ere zentzu horretan hartu dituzte Covid-19ari aurre egiteko neurriak. Neurri horien artean esanguratsuena komunikazioei dagokiona izan da. Guri ez ezik senide eta lagunei ere eragiten baitie horrek, eta gehienok hilabeteak daramatzagu bisitak egin ezinik, guraso edo seme-alabekin elkartu gabe, etxekoekin harremana izateko aukerarik gabe. Azpimarratu behar da, gainera, pandemiaren aurrean espetxeetan hartu beharreko neurrien inguruan nazioarteak emandako gomendioak euskal presooi ezartzeari uko egin diotela Espainiak eta Frantziak. Horrek ere adierazten du bi Estatuok gurekiko duten jarrera zital eta axolagabea eta urrunketa eta sakabanaketa mantentzearen gizagabetasuna, garai eta testuinguru berria kontuan hartu gabe ordainsaritzat espetxealdia luzatzeko irizpidearekin jarraituz.

Euskal preso politikoen eskubideen aldeko aldarria kaleratzeko aukerak ere mugatu egin ditu egoera honek. Eta, hala ere, era batera edo bestera, modu berriak asmatuz, gure eskubideen eta etxeratzearen aldeko aldarria eginez mobilizatu zareten guztioi eskerrik beroena adierazi nahi dizuegu. Baita aldarrikapen horiekin instituzioetan erantzunak eskatu dituzuenoi ere. Osagarriak izan behar baitute kalean eta instituzioetan egiten den jardunak, eta egindako lan horren emaitza da sakabanaketa eta urrunketaren politikan ikusten hasi garen norabide aldaketa.

Gaur ikusten duguna ere ez da, inondik inora, nahi genukeen mapa, eta oraindik bide luzea dugu presoon egoerari

zentzu gizatiarra ematera iristeko. Norabide horretan, presoon egoera ez ezik iheslari eta deportatuena ere konpontzeko orubea ezarri behar da. Eta lehen urratsa izan behar da euskal preso politiko guztiok Euskal Herrian eta 2º eta 3º graduan egotea, eta Estatu frantsesean betetako zigorrak Estatu espainiarrekoarekin batzea. Salbuespenezko neurri eta legediak behingoz ezabatzeko garaia da, ibilbidean bihar-etzirako ostertz berri bat eraikiz.

Aieteko Konferentzia burutu zenetik eta jarraian ETAk armak behin betirako utzi zituenetik hamar urte beteko dira. Garaia da, bada, gatazkaren ondorioei konponbidea emateko. Kontuan hartzen dugu 2018az geroztik espainiar eta frantziar gobernuek urrats propioak abiatu dituztela, aurreko gobernuen irizpideak lerroz lerro jarraitu gabe. Baina preso, iheslari eta deportaturik gabeko egoerara iristeko ezinbestekoa da Madril eta Parisek salbuespen politikak eta legedi berezituak, ordainsaria eskatu baizik egiten ez duten espetxe politikak, albo batera uztea guztiz.

2017an gure barne eztabaida amaitu genuenetik EPPKk behin baino gehiagotan adierazi du kaleratze bidea espetxe legediaren baitan egiteko prestutasuna; etengabean jarraitzen dugu ahalegin horretan, eta euskal preso politiko guztiak kaleratu arte jarraitzeko erabakia berresten dugu.

Baina ez da traba eta zailtasunik gabeko bidea. Salbuespeneko epaitegiek ezarritako zigorrek mendeku izaera hartzen dute guregan, eta horren ondorio dira aspalditik kalean eta aske behar luketen kideen egoerak. Esan behar dugu euskal preso politikook espetxealdi luzeak daramatzagula, legedia bihurrituz luzatzen dizkigutela zigorrak. Legediaren erabilera bihurritu horren harira, torturaren auziari egin behar zaio erreferentzia. Oihartzun berritua izan du azken hilabete hauetan, eta aipatu nahi dugu EHUren Kriminologiaren Euskal Institutuaren bidez ikertu eta identifikatutako milaka torturatuen gaia, torturatu horien artean baikaude gaur egun preso gauzkatenak. Izan ere, Estatu espainiarreko espetxeetan gaudenon artean 100etik gora kidek, % 57k zehazki, torturak salatu zituzten atxiloketa ondoren, eta torturapean erauzitako deklarazioak baliatu zituzten zigorrak ezartzeko. Euskal preso politikook gure ekinbidean eragin dugun mina onartzen dugun moduan, nahiko genuke guri eragindako minaren errekonozimendua jasotzea, torturatu gaituztela onartuz, zuzenbidearekin zer ikusirik ez duten epaiketen errealitatea onartuz, espetxealdiak luzatzeko lege-bihurritzeak, berrogei urtera arteko edo bizi osorako zigorrak, kartzela aldiak luzatu eta zigorra gogortzeko legediak espresuki prestatu izana eta abar onartuz.

Horrez gain, ehuneko 90ak betea dugu zigorraren laurdena, eta irteera baimenak legozkiguke; ehuneko 70 kidek betea dugu zigorraren erdia, eta 3º gradua legokiguke; ehuneko 30 kidek beteak ditugu zigorraren hiru laurdenak, eta baldintzapeko askatasuna dagokigu. Baina horrez gain aipatu behar dugu gaixotasun larriak dituzten kideen egoera, edota 30 urtetik gora preso daramaten Jakes, Jon Kepa eta Unairen egoerak, eta etxean baina baldintzapean jarraitzen duen Txistorrena edo 33 urte preso eginda larriki gaixotu arte kaleratu nahi izan ez duten Antton Troitiñorena. Aukera hau baliatzen dugu beraiei besarkada estu bana helarazteko.

Presoontzat ez ezik Euskal Herriarentzat ere beharrezkoa da espetxeak hustea eta iheslari eta deportatuak etxeratzea. Aspaldi honetan Euskal Herrian bizi den egoera berriak ezin du onetsi arrazoi politikoengatik inor espetxean, ihesean edo deportazioan egotea. Onartezina da etorkizunari begira, eta aspektu horiek konpontzea beharrizan bat da demokrazia eraikiko bada.

Aieteko Adierazpenaren laugarren puntuak jasotzen duena gogoratu nahi dugu hemen. Hau da, gatazkaren oinarrian arrazoi politikoak daudela, eta politikoak direla, beraz, gatazka horren ondorioak, gu preso egotea barne. Oinarrian dauden arrazoi horietara jo behar da gure herrian konponbide eta elkarbizitza demokratikorik izango bada. Ezinbestekoa da Euskal Herriaren nazio aitortza egitea, eta Euskal Herriaren borondate demokratikoa inoren inposiziorik gabe errespetatuz hastea etorkizunaren eraikuntza.

Etorkizunean nahi genukeen Herriak hainbat erronka aurkezten dizkigu izan ere. Mundu mailan agertzen diren krisiek, krisi ekonomiko eta sozialak, ekologia krisiak, osasun krisiak, eskubideen krisiak... aspektu propioa erakusten dute Euskal Herrian ere, arazo zehatzekin, konponbide zehatzen beharrarekin. Etorkizunean nahi genukeen Euskal Herriak gaurko gazteen eta belaunaldi berrien konpromisoa eta ahalegina behar du; gure herri izaera eta burujabetza, menpekotasun eta ezberdintasunik gabeko gizartea, feminismoa, gure hizkuntza, gure ingurunea, osasuna eta herritarren eta Herriaren eskubideak defendatuko dituzten belaunaldi berrien eta gazteen konpromisoa eta ahalegina ezinbestekoak ditugu Herri izaten jarraituko badugu.

Biharko Euskal Herri independentea helburu, euskal jendartearekin, gaurko eta biharko gaztekin ere, bidea egiteko prestutasunean ez dugu etsiko; egindako urratsetan ez gara atzera itzuliko. Etorkizuna dugu zain, eta bidean aurkitzen ditugun edo ezartzen dizkiguten oztopo eta zailtasunei aurre egingo diegu.

Batasuna, elkartasuna eta herriarenganako lotura!
Jo eta ke, irabazi arte!

Euskal Herria bihotzean,
2021eko apirilean

Euskal presoak euskal herrira!
Amnistia! Independentzia!



# Bada garaia!

✚ Larriki gaixo
🔒 Zigor batuketa
[¾] Baldintzapeko askatasunerako epeak
👪 Gurasoa
[+60] +60 urte
[+70] +70 urte
**+15** 15 urtetik gorako espetxealdia aurten
[2] 2. gradua
[3] 3. gradua
[*] 100.2 artikuluak malgutasun printzipioa sartzen du, sailkapen graduetako bakoitzaren aspektuak konbinatuz zigor-betetze eredua ezarriz.

## *ETXEAN PRESO*

### ARABA
Martínez Garcia, Idoia [3] 🔒 [¾] 👪 **+23**

### BIZKAIA
Martín Hernando, Jesus María [3] ✚ [¾] **+18**
Foruria Zubialde, José Ramón [3] ✚ [+70] **+17**

### GIPUZKOA
Etxaniz Alkorta, Sebas [3] [+70] **+18**
Gogorza Otaegi, Aitzol [2] [*] ✚ 🔒 [¾] **+21**
Labeaga Garcia, Urko [3] 👪 [¾] **+22**
Salaberria Etxebeste, Emilio [3] [+65] [¾] **+18**
Uranga Salbide, Patxi [3] 👪 [¾]
Lasagabaster Anza, Olatz [3] 👪 [¾]

### LAPURDI
Haranburu, Frederic [+65] 👪 **+31**

### NAFARROA
Pérez Aldunate, Xabier [2] [*] [¾] **+15**

### PARIS
Urrutikoetxea Bengoetxea, Iosu [+65] 👪

## *EUSKAL HERRIAN*

### CP ARABA
### ZABALLA
C.P. Araba
Portillo San Miguel, 1. N-1, km. 340
01230, Langraitz (Araba)
Agirre Ibañez, Xabier [3] [¾]
Bengoa López de Armentia, Asier [3] [¾]

Armendariz Izagirre, Iñaki [2] [¾] **+22**
García Arrieta, Garikoitz [2]
Lauzirika Oribe, Karmelo [2] **+15**
Lebrero Panizo, Roberto [2] [¾] **+19**
Loran Lafourcade, Gorka [2] [¾] **+17**
López de Okariz, Unai [2] 👪 **+19**
López Anta, Ángel [2] 🔒 **+18**
Markes Zelaia, Patxi [2] [¾] **+22**
Martínez de Osaba Arregi, Igor [2] 👪 **+21**
Orbe Sevillano, Zigor [2] [¾] **+16**
Polo Escobes, Sergio [2] 👪 **+21**
Saenz Olarra, Balbino [2] 🔒 **+18**
Vidal Álvaro, Gorka [2] [¾] **+16**
Barbarin Iurrebaso, Ainhoa [2] 🔒 **+18**
Yañez Ortiz de Barron, Iratxe [2]

**BESARKADA ETXEA - Gasteiz**
Iparragire Burgoa, Ibon [2] [*] ✚ 👪
**AITA MENNI OSPITALEA - Arrasate**
Arronategi Azurmendi, K. [2] [*] ✚ [¾] 👪 **+23**

### CP BILBAO
### BASAURI
Lehendakari Agirre 92
48970, Basauri (Bizkaia)
Fano Aldasoro, Unai [3] 👪
Badillo Borde, Irkus [3] 👪 [¾] **+16**

Bilbao Gaubeka, Iñaki [2] [¾] **+22**
Garces Beitia, Iñaki [2] [¾] 👪 **+22**
Pérez Zorriketa, Ugaitz [2] **+18**
Subijana Izquierdo, Juan Carlos [2] 🔒 **+18**

### CP DONOSTIA
### MARTUTENE
Martutene kalea, 1
20014, Donostia (Gipuzkoa)
Arregi Erostarbe, Joseba [2] [¾] [+70] 🔒 **+29**
Apeztegia Jaka, Karlos [2] 👪 **+23**
Atristain Gorosabel, Javier [2] 👪
Arrieta Llopis, Mikel [2] ✚ [¾] **+21**
Esnaola Dorronsoro, Aitor [2]
Karrera Arenzana, Asier [2] 👪 **+20**
Martitegi Lizaso, Jurdan [2] 🔒 👪
Ramada Estevez, Fco. José [2] [¾] 👪 **+19**
San Argimiro Isasa, Mikel [2] [¾] 👪 **+18**
Jauregi Amondarain, Oskarbi [2] 👪 **+19**

### CP PAMPLONA I
### IRUÑEA
C/ Colina Santa Lucía, s/n,
31012 Pamplona (Nafarroa)
Arizkuren Ruiz, Josetxo [2] ✚ 👪 [+60] 🔒 **+21**
Arruarte Santacruz, Garikoitz [2] ✚ [¾] **+17**
Dorronsoro Malaxetxebarria, J.M. [2] [+60] 👪 🔒 **+27**
González González, Jon [2] 🔒 👪 **+16**
Otegi Unanue, Mikel [2] 🔒 ✚ **+17**
Sola Campillo, Aurken [2]
Arriaga Martinez, Josune [2] [+60]
Comes Arranbillet, Olga [2] [¾]
Mendizabal Mujika, Idoia [2] 🔒 👪 **+15**

## *ESTATU ESPAINOLAN*

### C.P. EL DUESO
### SANTOÑA
**170 km - 1h 58'**

Avenida de Berriá SN
39740 Santoña (Cantabria)

Agote Cillero, Arkaitz 2
Atxurra Egurrola, Julen 2 +60 +24
Badiola Lasarte, Asier 2
Borde Gaztelumendi, Joseba 2 +60 ¾ +18
Borrero Toribio, Asier
Crespo Ortega, Jon 2 ¾ +18
Coto Etxeandia, Egoitz 2 ¾ +18
Etxeberria Oiarbide, Jon 2
Etxeberria Martin, Iñaki 2 ¾ +24
Fuentes Villota, Raúl 2
Garate Galarza, Endika 2 +60 +16
Goieaskoetxea Arronategi, Eneko 2
Goikoetxea Gabirondo, Andoni 2
Herrera Vieites, Aitor 2 +17
Herrador Pouso, Juan Carlos 2
Inziarte Gallardo, Juan Manuel 2 +65
Karasatorre Aldaz, Juan Ramón 2 +19
Telleria Uriarte, Angel 2 +60
Makazaga Azurmendi, Xabier 2 +19
Martínez Ahedo, Gorka * +23
Rubenach Roiz, Jon 2 +17
Vallejo Franco, Iñigo 2 +17
Zapirain Romano, Iñigo 2
Armendariz G.Langarika, Lierni 2 +20
Etxebarria Caballero, Beatriz

### C.P. LOGROÑO
**170 km - 2h 07'**

Calleja Vieja, 200, Apdo. 217
26006 Logroño

Agirresarobe Pagola, Gurutz 2
Aiensa Laborda, Ibai 2 +18
Aiensa Laborda, Mikel 2 +19
Aragon Iroz, Santiago 2 +19
Arzalluz Goñi, Asier 2 +18
Franco Martínez, Bittor 2 ¾ +18
Fresnedo Gerrikabeitia, Aitor 2 ¾ +24
Goikoetxea Basabe, Arkaitz 2
Iragi Gurrutxaga, Harriet 2 +20
Lupiañez Mintegi, Gorka 2 ¾
Mardones Esteban, Asier 2 +16
Narvaez Goñi, Juan Jesus 2
Olarra Guridi, Jon 2 +18
Olabarrieta Colorado, Iker 2 ¾ +15
Olaizola Baseta, Aitor 2 +19
Otegi Eraso, Andoni 2 +18
Troitiño Ciria, Jon 2 +15
Zabalo Beitia, Xabier 2 ¾ +18
Alberdi Uranga, Itziar *
Mujika Goñi, Ainhoa 2 +18
Oña Ispizua, Josune 2 +16
Saez de la Cuesta, Alicia 2 +19

### C.P. BURGOS
**215 km - 2h 17'**

Avenida Costa Rica, s/n Apdo. 253
09001 Burgos

Arri Pascual, Álvaro 2 ¾ +25
Aretxabaleta Rodriguez, Liher 2
Beobide Arza, Ibai 2
García Aliaga, Aitor 2 +19
Segurola Beobide, Joseba 2 * ¾ +17
Vicario Setien, Gregorio 2 +60 +19
Zubiaga Bravo, Manex 2 +18
Zurutuza Sarasola, Jose Antonio 2 +16
Zubiaurre Agirre, Jon 2 +19

### C.P. ZARAGOZA
### ZUERA
**245 km - 2h 54'**

Autovía A-23, km. 328
50800 Zuera (Zaragoza)

Almaraz Larrañaga, Agustín 2 ¾ +25
Azurmendi Peñagarikano, Mikel 2 ¾ +22
Barrios Martín, José Luis 2 ¾ +22
Izpura Garcia, Mikel 2 +60 ¾ +21
Lerin Sánchez, José Ángel 2
Solana Matarran, Jon Igor 2 +20
Merino Bilbao, Guillermo 2 ¾ +20
Murga Zenarruzabeitia, Andoni 2 ¾ +24
Vila Mitxelena, Fermin 2
Gallastegi Sodupe, Lexuri 2 +18
Pérez Aristizabal, Eider 2 +19
Pedrosa Barrenetxea, Maite 2 ¾ +22

### C.P. DAROCA
### ZARAGOZA
**345 km - 3h 31'**

Ctra. Nombrevilla, s/n
50.360 Daroca (Zaragoza)

Bilbao Solaetxe, Unai 2 +18
Castro Zabaleta, Manex 2
Gallaga Ruiz, Javier 2 +60 +22
Gurtubai Sánchez, Sebas 2 ¾ +18
Marcos Álvarez, Faustino 2 ¾
Portu Juanena, Igor 2

### C.P. SORIA
**260 km - 2h 57'**

c/ Marqués del Saltillo n. 1
42004 Soria

Agirre Lete, Juan Luis 2 ¾ +24
Altable Etxarte, Jesús Mª 2 +60 ¾ +26
Ayestaran Legorburu, J. Lorenzo 2 +60
Bravo Saez de Urabain, Zigor 2
Rodríguez López, Asier 2
San Sebastián Gaztelumendi, Mikel 2
Zelarain Ortiz, Oskar 2 +18

### C.P. DUEÑAS
### LA MORALEJA
### PALENCIA
**310 km - 3h 03'**

Carretera P-120
34210 Dueñas (Palencia)

Aginagalde Ugartemendia, Beñat 2
Aranburu Sudupe, Gotzon 2 +21
Besance Zugasti, Juan Carlos 2
Bienzobas Arretxe, Jon Mikel 2 +21
Etxeberria Goikoetxea, Garikoitz 2
Eskudero Balerdi, Gregorio 2 +65 +18
Iglesias Chouzas, Juan Carlos 2 +21
San Pedro Blanco, Jon Mirena 2 ¾ +25
Miner Villanueva, Imanol 2 +18
Maurtua Eguren, Aitzol * ¾ +18
Mariñelarena Garziandia, Luis 2 +19
Sarasola Yarzabal, Mattin 2

### C.P. LEÓN
### MANSILLA
**370 km - 3h 36'**

Finca Villahierro
24210 Mansilla de las Mulas (León)

Elejalde Tapia, Fernando 2 ¾ +23
García Jodrá, Fernando 2 +20
Ginea Sagasti, Josu 2 ¾ +18
Guridi Lasa, Iñigo 2 +20
Lima Sagarna, Iker * ¾ +18
Novoa Arroniz, Jose Mari 2 +21
Parot Navarro, Unai 2 +60 ¾ +31
Ugarte López de Arkaute, Diego 2 +16

Estatu espainoleko espetxeen urruntasuna Donostia-tik zenbatua.

-

Estatu frantseseko espetxeen urruntasuna Bilbo-tik zenbatua.

## C.P. ASTURIAS
### VILLABONA
**385 km - 3h 57'**

Finca Tabladillo (AS17-Avilés)
33480 Villabona (Asturies)
Agirrebarrena Beldarrain, Aitor 2 +18
Berasategi Eskudero, Ismael 2 +17
Blanco Santisteban, Zigor 2 ¾ +18
García Justo, Asier 2 +19
Gómez Ezkerro, Jesus María 2 +60 ¾ +20
Larretxea Mendiola, Joanes 2
López de la Calle Gauna, Alberto 2 +60 +16
Egues Gurrutxaga, Ana Belen +19
Gartzia Montero, Ainhoa 2 +17
Zaldua Iriberri, Itsaso

## C.P. TOPAS
### SALAMANCA
**460 km - 4h 32'**

Ctra. N-630, km. 314
37799 Topas (Salamanca)
Ordoñez Fernández, Josu 2 ¾ +19

## C.P. ÁVILA
### BRIEVA
**475 km - 4h 09'**

Carretera de Vicolozano, Apdo. 206
05194 Brieva (Ávila)
Aramendi Juanena, Alaitz 2
López Resina, Dolores 2 +70 +19

## C.P. MADRID I
### ALCALÁ
**450 km - 4h 49'**

Carretera de Alcalá Meco, km. 4,5
28803 Alcalá de Henares (Madrid)
Jauregi Espina, Jaione +60
Iparragirre Guenetxea, Marixol +16

## C.P. MADRID V
### SOTO DEL REAL
**430km - 4h 26'**

Carretera M-609, km. 3'5
28791 Soto del Real (Madrid)
Garitagoitia Salegi, Iurgi
Reta Frutos, Iñaki +60

## C.P. MADRID VI
### ARANJUEZ
**520km - 5h 07'**

Carretera N-400, km. 28
28300 Aranjuez (Madrid)
Gutiérrez Carrillo, Iñigo 2 ¾
Lizarraga Merino, María + Umea 2

## C.P. MADRID VII
### ESTREMERA
**520 km - 5h 06'**

Carretera M-241, km. 5,750
28595 Estremera (Madrid)
García Gaztelu, Xabier +20
Palacios Abad, Gorka +17
Gallastegi Sodupe, Irantzu 2 +21

## C.P. CASTELLÓ I
**575 km - 5h 39'**

Carretera de Alcore, km. 10
12006 Castelló
Cano Hernandez, Pedro María +18
Gallastegi Sodupe, Orkatz +17

## C.P. ALMERÍA
**1.005 km - 9h 40'**

Carretera Cuevas Ubeda, km. 2,5
04131 El Acebuche (Almería)
Krutxaga Elezkano, Iñaki +20
Viedma Morillas, Alberto +19

## C.P. PUERTO III
### CÁDIZ
**1.020 km - 10h 10'**

Carretera Jerez-Rota,
km. 6, 4 Apdo. 555
11500 Puerto de Santa María (Cádiz)
Barreras Díaz, Oskar ¾ +23
Cotano Sinde, Aitor
Etxeberrria Garaikoetxea, J. Mari +18

# *ESTATU FRANTSESEAN*

## MONT DE MARSAN C.P.
**260 km - 1h 51'**

Chemin de Pémégnan B.P. 90629
40.006 Mont-de-Marsan Cedex
Etxaburu Artetxe, Aitzol
Goienetxea Iragorri, Xabier
Iruretagoiena Lanz, Luis +60
Martínez Bergara, Fermin +60 ¾ +16
Sirvent Auzmendi, Ekaitz
Suberbiola Zumalde, Igor
Urbieta Alkorta, Josu

## LANNEMEZAN C.P.
**330 km - 2h 18'**

Chemin de la Plaine B.P. 166
65.307 Lannemezan Cédex
Abaunza Martínez, Javier +18
Agerre, Didier ¾ +19
Agirregabiria del Barrio, Arkaitz
Aspiazu Rubina, Garikoitz
Esparza Luri, Iñaki +16
Esnal, Jakes +65 +31
Fernández Iradi, Ibon +17
Iriondo Iarza, Aitzol
Karrera Sarobe, Mikel
Maiza Artola, Gurutz +70
Oiartzabal Txapartegi, Asier +19

## MURET C.D.
**425 km - 3h 08'**

Route de Seysses B.P. 312
31.605 Muret Cédex
Fernández Aspurtz, Joseba
Parot Navarro, Ion +65 +31

## RENNES C.P.
**795 km - 7h 39'**

18 bis, Rue de Châtillon B.P. 3.107
35.031 Rennes Cédex
Moreno Martínez, Itziar

## REAU SUD FRANCILIEN C.P.
**930 km - 8h 33'**

CR 8 Lieu dit du Moulin à Vent
77.550 Réau
Lesaka Argüelles, Izaskun
Ozaeta Mendikute, Ainhoa
Sorzabal Díaz, Iratxe

**Presoen Aldeko Batzordea** Zuatzu, Easo eraikina, 4 behea,
20018 Donostia (Euskal Herria)
**L.G. / D.L.:** SS-1471-2012



# EPPK:
## Dispertsio eta urruntasunaren mapa

